# Maïte Rungis

# Ekonomiako lehen pausoak

lehen partea

Xabier Amurizak euskeratua.

Hastapenak - 20
1974 - Ekaina

M. RUNGIS
**EKONOMIAKO LEHEN PAUSOAK**
**Lehen partea**
**I**

Euskeratzailea:
Xavier Amuriza

LUR editoriala
Villa Zutik, Paseo Arbola,
Donostia

Inprentatzen du:
Ellacuria
Avda. del Generalísimo, 19
Erandio-Bilbao

D. L.: BI - 13 - 74
ISBN: 84-7099-033-0

LUR editoriala euskal literatura eta kultura inprimatu aurrerakoiaren desarroiloak gaur egun dituen beharkizunei erantzun bat ematen saiatzen da. Horrela, argitaratzen dituen lanak ez dira beti editorialaren iritziekin bat etortzen. Autorea da kasu guztietan bere obraren erantzulea. LUR editorialak bere izenez agertzen eta agertuko diren ohar eta agirien erantzunkizuna hartzen du soilik.

# HITZAURRE

Sarritan batek ez daki zerbait berak egin duelako den ona ala ona delako egin duen. Itzulpen hau eginez gero, ez dadukat merezi zuela esatea beste erremediorik, tenteltzat har nazaten nahi ez badut —nahiz eta izatea okerrago litzatekeen—. Kasu honetan ordea, lasai esan dezakedala uste dut liburu hau ez dela neronek euskeratu dudalako ona, ona delako euskeratu dudala baizik. Jakin arazi nahi dut ezin izan dudala frantsezko orijinalik eskuratu. Lotsa ere ematen dit bigarrenez huts bera aitortu beharrak, Huxleyren "Bai mundu berria"ren itzulpenean ere antzeko zerbait gertatu baitzitzaitan. Kasu honetan ingeleseko itzulpena ere nahi nuen, euskerak, anitz arrazoigatik, ingelesari arreta berezia behar diola uste baitut. Baina ez bata ez bestea. Ba dakit gure lagun haundi batek ahalak eta bost egin dituela bila eta hark aurkitu ezin izan dituenean ez zegoela zer eginik. Hauk honela, beste bati oratze-

kotan ere ba nengoen, batez ere ingelesez idatzitakoren bati. Ez pentsa frantsesa eta ingelesa esatean, zintz egiten bezala dakitzadanik hizkuntzok, ez eta gutiagorik ere. Baina dakidan apurrez, lagun batzuk dakiten askiz eta batez ere gazteleraren laguntzaz, dudarik ere ez zehazkiago egin ahal izanen nukeela. Hala ere —eta itzul-inguru guzti hau honetara zetorren batez ere— liburu honixe ekitea erabaki nuen, zeinek esan nahi baitu alderdi on asko ikusten niola. Hona laburki zeintzu:

1. Ekonomiako testoek ejedrezko edo zerbaitsuko araudi bat ematen dute sarritan, hotzak, hitz jario antzuz beteak, terminologia "teknikoa" delakoaren azpian gizonaren eta gizartearen izate zatirik haundiena jokatzen dela estali nahiz bezala. Ez diot hau neure ezjakintasuna zuritzeko, bai baitakit jakintza honetan aurreratuala, anitz gai zail dagoela nik ulertzeko baino nahasiagorik. Baina hau Ekonomiako "hastapenak", "lehen pausoak" dira. Maite Rungis-i benetan eskertzekoa da Ekonomiako gai funtsezkoen batzu honen argi eta ulergarri azaltzea, zehaztasun zientifikorik galdu gabe. Ez dira alferrik liburuko bost kapitulu nagusiok jendeari emaniko hitzaldiak, beraz, ahalik zorrotzen eta konpreni errezen eginak.

2. Liburu honen bigarren alderdi haundia Ekonomia Politikarekin bat bat egitea da, ez preiritziz edo hobeto ematen duelako, hala dela frogatuz baizik. Hain honela da hau non zientzia edo teknika honi Ekonomia baino areago Ekonomia Politikoa deitzen baitio. Ez da deitura kontua

bakarrik. Bestalde edozein mandok ere ba daki Ekonomiak ba duela Politikarekin zer ikusirik. Baina zer ikusia dadukala jakitetik gai eta zehaztasun bakoitzean bien lotura eta elkargoa, areago elkarrekikotasuna, garbi ikustera, alde haundia dago.

3. Ekonomista on bezala, Maite Rungisek datoak ematen ditu, errealitatea deskribatzen du eta handik ondorioak, konklusioak ateratzen. Baina ez du irakurlea zifraz nahasten, numerotan nora ezik uzten, kapitalismoaren izakera argiro bezain sakonki ematen baizik. Liburu hau dakienak, beraz, uste dezake nahikoa ondo ezagutzen duela mundurik gehiena maneiatzen duen aberea, kapitalismoa.

4. Baina abere bat ondo ezagutzeak esan nahi du hortzak eta hutsak begiratu behar zaizkiola, ferekuak eta ostikadak estudiatu behar zaizkiola. Honetantxe datza nire ustez liburu honen alderdi nagusia, ekonomiako testoetan nekez aurki daitekeena: kapitalismoaren azalpenaz batera kritika osoa egiten dio liburu osoan zehar, argi baina sinplekerian erori gabe, sakon baina irakurleari burua hautsi gabe. Gorago esan bezala, hala azalpena nola kritika datoetan oinarriturik dator. Honela noiznahi entzuten den konzepto asko, akaso sarritan topiko marro bihurtu, —nola, esaterako, klase burruka— mamiz eta esanahiz beterik uzten du liburu honek. Gero hor etorriko zaigu filosofia —argi dagoena iluntzen eta ilun dagoena lorrintzen dakien zientzia sorgin hori— klase burrukan ez dakit zer eta ba dakit zar be-

rezi behar dela, ez dakit zein antzinako filosofok zera eta bera esan zuela, gaur "klasetasun" kontzeptoa krisisean dagoela, gaindurik ez esatearren, zeren Marxek (haritzaren gerizpe freskotan eguerdiro mokordo bana egiten zuten antzinako filosofoen barkamenez) hura esan zuenetik hona euri asko egin omen baitu, zientzia berri asko sortu omen baita (haur mordo bat ere bai segur asko, eta ez guti deskuido bati eskerrak), ekonomiaz beste gauzarik ere kontuan eduki behar omen baita, etab, etab. Zeozergatik zioen gure esaerarik zaharrenak: zenbat buru hainbat buztan. Eta ez pentsa buztanaren kontra ezer dudanik, zeren eboluzioari nekez barkatzen diodan adar jotzeetarik bat buztan galtzea baita hain zuzen. Gure asaba gaixoei mendeak eta mendeak joan zitzaizkien beren esaera lainuzkoa buztangabetasunera egokitu ezinez, batek esan zuen arte: zenbat buru hainbat artaburu. Baina nola artaburua pentsatzen hastea (idiren batek jaten ez badu behintzat) azera kontseilari hartzea bezain arriskutsua den, beti dago datorik argienetan ere "datotasuna" behintzat dudan jartzeko arrazoirik. Eta orduan alferrik du Maite Rungisek bigarren kapituluko zati baten konklusiotzat galdatzea: "Nor ausar daiteke, zifra hauk ikusirik, gaur klase burruka modatik pasaturik dagoela esatera, nahiz eta itxurak aldatu aurreko mendeari buruz?"

Jakina zifrak, hau da, Ekonomia, ez dela gizartea darabilen "bakarra", jakina astoez gainera kirkirak ere ba daudela. Baina astoa arrantzaka hasten denean, hobe dute kirkirek isiltzea.

5. Liburu honetan Frantziako ekonomia aztertzean, oker bat dena mugaz behekoontzat, alderantziz da mugaz goiko euskalerri zatiarentzat. Bestalde gainera kapitalismoak adakera berdintsuegia daduka laterri guztietan, diferentziak eta guzti ere.

Liburu honen oker bat orain zortzi-hamar urtetakoa izatea liteke akaso. Niri ez zait testo batentzat gaurkotasun haundirik galtzea denik iruditzen. Hobe litzaikegu kapitalismoa urte batzutan modatik pasatzeko moduko atorra bat balitz edo gaur dazagunak etzi ez ezagutzeko bezain aldakor. Honela gutienez bariazio pizka bat genuke.

# LEHENENGO KAPITULUA

## ZER DA POLITIKOA?

Gure aldion Ekonomia Politikoa kultura jeneraleko zati bat dugu. Ez da beti honela izan. Beste aldi batzutan espezialisten arlotzat jotzen zen, jauntxosail urri batek bakarrik maneiztzekoa; jaun trebeak noski formula eta silogismo bihurtzen aberatsen aberastasunari eta pobreen pobretasun patuzkoari justifikazio moral bat ematera destinaturiko arrazonamenduak.

Eta jakina, pribilejiatuen zientzia, pribilejiatuek beren justifikaziorako moldatua izanik, nahi eta ez gainbehera etorri behar langile mugimenduaren boladapean. XIXgarren mende erdian hasten da gainbeheratze hau eta ez da harez gero geratu. Baina jakintza ekonomikoa, nahiz eta bere erkintasunagatik uxatu eta salatua izan, astiro astiro kazkonduz eta garbituz etorri da. Gaur zientziatzat daduka bere burua.

Baina zientzia bat sortzeko nahikoa al da ba dela uste izatea eta hiru-lau teknikakeriaz hornitzea? Ez alafede. Baina ekonomiako hiztegia beti izan da jakin nahi zutena borondaterik onenez liburuetan ikasi nahi zutenei pot eragiteko bezain konplikatua. Honez gainera Zientzia Ekonomikoak gero eta gorantzago doazela kontuan hartzen bada, ez da harrigarri erdiko gizon batek adorea galtzea hain gai zabal eta itxuraz behintzat hain gakotsuaren aurrean.

Hala ere denok dakigu gaur problema ekonomikoen inportantziaren berri. Hala gure bizitza nola gure seme-alaben eta zibilizazioaren etorkizuna problema hauexen pentzudan daude. Gure bakar-destinoa aparte utzirik, munduko bakea eta ugaritasuna erabaki politikoen mende daude, hauk halaber munduko eboluzio ekonomikoak determinatzen dituelarik.

Gure aldiko gizonak hain jabeturik daude dependentzia honetaz non egunean baino egunean gehiago baitira ekonomiako lehen pausoetan saiatzen direnak. Hizparringiek, iritziaren gidari izan beharrean sarritan bere agerpen besterik ez direnek, egunetik egunera toki gehiago damaiote ekonomiako kontuei. Bakoitzak bere erara, jakina. Batzuk artikulo zentzuzkoz eta dokumentatuz, bestetzuk grafiko komentatuz baita humorezko dibujoz ere, irakurlea nahasi gabe jakitun jartzera destinatuak. Baina han eta hemen kronika ekonomikoak gehituz doaz hedaduraz eta interesez.

Nekez aurrelari ohi dabilen heziketako Ministerioak (1) berak ere bizkortu beharra sentitu du,

bere ikasplanetan ekonomiako kursoak sarturik: dela Geografia Ekonomikoa, dela Ekonomia bera, edo teknika modernoei aplikaturiko Ekonomia. Gaur egun, egia esan, irakasmaila batzuk bakarrik —instituto modernoek eta eskola teknikoek— dadukate kurso hoietarako eskubide. Baina eboluzioa hasirik dago, eta laster gero eta frantsez gehiagok ikasiko ditu Zientzia Ekonomikoen hatsapenak atzerrian ia gertatzen ari den bezalaxe.

Zientzia sorgin samar baten lagun egin daitezen ote? Ala akaso sarritan konturatu gabe sarturik gauden giro ekonomikoaren kontzientzia har dezaten? Dudarik ere ez joera bietatik dagoela zerbait. Baina egia askoz hurbilago dago bigarrenetik lehenengotik baino.

Ekonomia politikoa —hobe litzateke Politika Ekonomikoa deitzea— ez dago inola ere gure arduretatik aparte; aitzitik, ordea, gure arduren irazki ezkutua da sarritan. M. Jourdain-enari ekinik, egun osoan ari gara, konturatu gabe, Ekonomia politikoaz berriketan.

## I. EGUN OSOAN ARI GARA EKONOMIA EGITEN

Nola dezakegun konturatu gabe Ekonomiarik egin? Oso erraz: gure inguruan ematen ari den antzerki ekonomikuko pertsonaia printzipalak interpretatuz. Gutariko bakoitzak, gizon nahiz emakume, hiru aktoretza ditu obra horretan: konsu-

mitzaile gisa, produktore gisa eta hiritar gisa. Azter dezagun hurbilagotik.

Konsumitzaile gisa Jaun Dupontek, Andre Durandek, zuk eta nik ordeztu ezineko moldatzaile-lan bat egiten dugu Frantziako ekonomian, sakatuz edo frenatuz, berrituz edo alberrituz. Dudan al zaudete? Jar ditzagun orduan adibide batzu.

Egunoro janariak erosten dituzu eta erostean aukera mordo bat egiten duzu. Idikia ala ardikia erosi, idi-hazkuntza bultzatzen duzu (eta gainera idiaren prezioa igon arazten edo behintzat iraun arazten) ala ardi-hazkuntza. Mozkinak baino xerra gogokoago bazaitzu, okela-merkatuari halakoxe direkzioa ematen diozu, alde batera utzirik zer buruhauste dakarkiezun "zu idira pasatzearren" xerra merkatzekotan dabiltzan ministroei. Era berean, udaberrian, urri dabilenean, fruta erosten baduzu, prezioak apur bat igoten laguntzen duzu, erosketa bera udan eginik, ordea, eskari-gutitzea eragotziko zenuke. Sasoi kontuak.

Har ditzagun orain janariez beste adibide batzu. Zeure alkondara edo atorra zaharra aisa alda dezakezu beste nynolezko alkondara edo atorra batez. Eskubide osoa dadukazu. Baina konturatzen al zara nylonezko erostean hari naturalen (alkotoi, artile, zeta) industrien hondamendia azeleratzen duzula, zuk nahiago dituzun hari sintetikoen aurrerapen urriki gabea eraginik? Alkondarategi batera sartzean, pentsatzen al duzu industria berri bat —proportzio xit kazkarrez noski, baina proportzio batez nolanahi— bultzatzen

duzula eta okerragotzen Vosgoetako hari fabriketan, Ifarreko oihal fabriketan eta Rhone haraneko zetategietan dabilen kaosa?

Halaber hondarrerako plastikuzko sandaliak nahiago badituzu hiko zapatila larruzkoak baino, gaurko kimika-adarrik bizienetariko baten zabalkundea azeleratzen duzu larrugintza klasikoaren kaltez. Ba liteke zure erosketak Felaise aldean minuto batzutako paroa ekartzea. Erositako gaien klaseari buruz egia dena berdin duzu egia erosiak izan diren denda klaseei buruz ere; okela baztérreko harategian erosten baduzu, fruta hauzoko dendaxkan, eta alkondara kale ertzeko ehundegian, komertzioa estruktura sor eta garestietan manten arazten duzu. Eta dena hauzoan bertan erostea erosoago zaitzulako.

Baldin ordea, erosketa guztiak almazen haundietan, hazten eta hazten ari diren komertzio-katea haundi hoietako sukursal batean edo Leclerc almazen batean egiten badituzu, Frantziako komertzio estrukturari modernotzen laguntzen diozu, era batera prezioen altzatzearen kontrako gobernuaren propaganda kanpainan kolaboratzen duzularik.

Zenbat ondorio dakarten eguneroko erosketak bezalako huskeria batzu! Orain uler dezakezu zer paper inportantea jokatzen duzun Ekonomiaren eboluzioan. Berdin esan daiteke konsumitzaile gisa daduzkazun beste aktibitate guztiez ere. Esaterako, etxagintzari buruz xit paper desberdina joka dezakezu nola finantzatzea erabakitzen duzun: pisu bat elkar-propietatez erostekotan au-

rreztzen baduzu, toki bat merezi duzu Frantziako konztrukzioaren apostoluen ohore koadroan, zure aportazioari eskerrak etxagintza gehigarri bat posibletuko baita. Baldin, ordea, alkilerra ordaintzen baduzu, edo alkilerren altzatzea eraginen duzu batazbestea baino alkiler haundiagoa ordaintzera makurtzean, edo alderantziko papera jokatuko. Era berean Parisera bere ikasketak bukatzera datorren ikasleak nahiz Parisko fabrika bateko zapataz ia jubilatuak erantzukizun zati bat daduka Paris aldeko bizitzetxe krisis ikaragarrian, zeinetan 500.000 familia eskubidezko zaion aterpe dezenterik gabe baitago. Ba dakizu, beraz, konklusioa argi dagoela: konsumitzaile gisa zera nahiz bera egin, egintza definitibo eta bueltarik gabeko bat egiten duzu, bere neurritxoan eboluzio ekonomikoari hartuko zukeenaz beste zuzenbide bat ezarriko diona.

Berdin esan genezake produktore gisa dadukazun jokabideaz ere. Nazioari ongarriago edo ezongarriago zaion zerbait produzitzen lan egin, lagundu egiten duzu zeure zoko apaletik nozioko ekonomia aurrerapen bidetik zuzentzen edo bestela izugarrizko anemia hondagarrirantz bultzatzen. Hasierako aukera, jakina, ez dadukazu hain zeure eskuan: Ekonomia kapitalista bateko alokatu bat zarenez gero, ez dadukazu gizarteak damaitzun enplegua hartzea beste erremediorik, zure lanaren azken ongarritasunaz gehiegi arduratu gabe. Hala ere, gakoak zutik dirau: zuk nazioko ekonomia desarroiloari ongarriago edo ezongarriago zaion moduan joka dezakezula.

Honela nahiz bestela, zu, zeure lekuan, nazio-

ko joko ekonomikuko ajente bat zara nahiz eta horren kontzientzia hain garbirik ez eduki, eta horrela izanik zerorrek ere parte hartzen duzu hala produkzio-sistima arkaikoen euspenean —enpresa kazkar, xit ugari eta gaizki hornituen kasua, zeinetan langileen esplotazioa zorrotza baita—nola produkzio-eskema berrien desarroiloan— enpresa ondo hornituak, emankortasun haundikoak eta produzitzen duten gauzan xit espezializatuak.

Akaso ikasleek uste izanen dute berak aparte daudela joko ekonomiko honetatik. Ilusio hutsa. Profesio ongarriago edo ez-ongarriago bat ejerzitzeko prestatzen hasten denetik gora, oraintxe —eta aurretixik— ari da nazioko joko ekonomikoari eragiten. Deretxoko espezialista gehiegi dagoen nazioan jurista izateko preparatzea, injineroak, matematikoak eta tekniko industrialak falta direnean, koipe ekonomiko nazional bat pilatzea bezalatsu da azkenerako ekonomia herbalduko duena.

Familiako ama bera ere arteko da joko ekonomiko honetan produkzioko ajente bezala: mundura dakartzan eta hazten dituen haurrek bihar-etzi nazioari hazten eta aberasten lagunduko diote, eta trantzerik baletor etsaiengandik defenditu ere bai. Frantzian beranduegi ohartu gara belaun-aldi osasuntsuen inportantziaz. Ba dirudi, ordea, orain konturaturik gaudela, demografiaren berbizkunde itzelean aurkitzen baikara. Amei eskertu behar jaiotze haundiko nazioei prometatzen zaizkien “goiz kantari” hauk. “Amen alokairu” bat prestamen sozial bezala sortzeak ere garbi

adierazten du nola haintzat hartzen den amen papera nazioko bizitza ekonomikoan.

Ba dago azkenez hirugarren parte harrera bat ere nazioko ekonomian: hiritarrena. Hiritar gisa egunoro dihardukazu nazioko ekonomia bidetzen. Nola? Lehenengo zergapeko bezala, zerorrek mantentzen baituzu Hazienda Publikoa, historiak ezarri dion anitz eta anitz eginkizun ekonomiko seguratzea permetatuz. Ba al dakizu litro bat gasolina erostean 73 % estatuak daramala; zure tabako prezioaren 70 % Hazienda Publikuko kutxetara doala diru-karga publikoak finantzatzeko; bide bera daramala kotxeen, motorren eta tresna elektrodomestikoen preziotik 25 %-ek, gaz eta ikatz prezioen 10 %-ek, eta ia gainetiko beste gai guztien 20 %-k? Zertan esanik ere ez urtean behin edo hirutan ordaintzen dituzun errenta gaineko zergak ere toki berdinera doazela.

Hiritar gisa ordea, ordaintzea bakarrik ez dagokizu. Hartu ere hartzen dituzu estatutik laguntza batzu, segur asko konturatzen ez zarenak baina hala ere hor daudenak. Estatuak argitzen ditu kaleak, biltzen zikinak, hobetzen karreterak, eraikitzen eskolak zure seme-alabentzat eta hospitaleak gaixotzen zarenerako; gainera hor ditu —¡berez zeure onerako!— polizia, harmada, tribunalak, diplomatiko saila... Mundura etorri aurretik ere harturik zaude Estatuko laguntza bat (jaio aurreko prestamenak) eta hildakoan ere zure burua kotizatua izanen da prebisio sozialerako (kanposanduen ardura). Orain konpreni dezakezu hiritar gisa aktore bikoitz zarela joko ekonomikoan, batetik ordaintzaile bestetik hartzaile.

Baina hirugarren modura ere jokatzen duzu, zeure boto-xartelari eskerrak. Izan ere zure eta beste frantziar guztien mende dago Estatuak zer bide emanen dion nazioko ekonomiari. Modu batez bestez, kandidato baten ala beste baten alde botatu, joera ekonomiko desberdindunak aginteratzen dituzu. Batzuk enplegu osoa eta masa herritarren bizimaila altzatzea dukeite helburu nagusitzat; beste batzuk produkzioko adar pribatuak zaintzera eta errenta nazionalaren banaketa efektiboa mantentzera joko dute; batzuk diru-estabilitateari eusten saiatuko dira (nahiz eta paroko preziotan izan); beste batzuk ordea espansio ekonomikoari ekinen diote batez ere (nahiz eta bizimailaren bizkarretik izan). Gainera kontuz kandidatoek zer agintzen duten, deserantzukizun politikoak demagogiara baitarama. Kandidatoak diotenetik gabe dagitenetik juzgatzean, eta batzuren eta ez beste batzuren alde botatzean, paper izugarriro inportantea jokatzen duzu nazioko ekonomiaren eboluzioan.

Hona adibide bat: Estatuak hiritarrengandik —zure eta niregandik— hartzen dituen 1.000 frankotarik, gaur egun 284 militar-gastuetan erabiltzen ditu, 103 irakaskintzan (maisuen alokairuak eta eskola berrigintza), 150 nazioa industriatzen, 33 errenta mugatuko etseak eraikitzen, 187 anitz subentzio kultural, sozial eta ekonomikotan, 67 zorrak ordaintzen, 23 gerrako ezbehartuen indemnizazioan, eta ia gainetiko guztia (153) funtzionarioen soldatetan edo administrazio etxeak zaintzen. Akaso uste dukezu diru hori gaizki enplegaturik dagoela eta hobe litzatekeela honetan

gehiago eta horretan gutiago erabili. Horra, bada, hori zeure pentzudan dagoela, zeren presupostu honek, maioria politiko batek eusten dionez gero Parlamentuan eta Gobernuan, beste maioria politiko bat behar baitu funtsez aldatua izateko.

Zure, nire eta gainetiko frantziarren jokabidea da presupostu hau esplikatzen duena. Hiritar bezala, nazioko joko ekonomikuko aktore bezala, gutariko bakoitzak erantzukizun zati bana dadukagu.

Laburki bada, Ekonomia Politikoa bizitzatik lekutako hizlari pedantekumeen kontua ez ezik, errealitate bat duzu zure egunoroko jardunaren mendeko eta moldatzaile dena era batera. Ba liteke oraintxe arte ezjakinean egotea jakizu ordea, konsumitzaile, produktore eta hiritar bezala, derrigorreko eta ordeztu ezineko ajente bat zarela.

## II. ZER DA EKONOMIA POLITIKOA?

Esanak esan, ordea, guztiz oker zeundeke gorago esanaz konformatzekotan. Egia da Ekonomia Politikoak ez dadukala zure izateari arrotz zaion inolako sorginkeriarik. Ikus berri duzu egun osoan ari zarela bertan parte hartzen. Baina nola egunero darabilzun elektrika esku artean akaso zer den zehazki jakin gabe, hala ari zara puntarengo aktore ekonomiko izaten, baina hala ere ezjakinean segitzen duzu jokatzen ari zaren Ekonomia

Politikoa izatez zer den. Zer da zehazki Ekonomia Politikoa?

Zientzia bat? Hala nahi izan da luzaro, baina gaur ez dizu inork zientziatzat jotzen. Egia esan, mende honen hasieratik gora egundoko ahaleginak egin izan dira Ekonomia berritsukeria deduktibotik garbitzeko, zeinetara kondenatu baitzuen ez datorik ez frogarik gabeko afirmazio mende batek. Gaur edonork daki ez dagoela edozer esaterik azterturiko edozein fenomenori buruz. Gaurko eboluzioaren alderdi nagusia dokumentazio ahalegin haundi bat da: inkestak, haztaketak, izendegiak..., ugaltzen eta ugaltzen ari dira, fenomenotzat har daitekeen edozer neurtu ahal izateko. Dela konsumoa, produkzioa, errenta, prezioak, dela enplegua, komertzioa nahiz dirua, gaur edozeri ezartzen zaio Ekonomian numerozko ebaluazio eta azterketa matematikoa. Kurben, "puntuzko lainoen", korrelaziozko koefizienteen... hizkera bete betean sartu da ekonomia-lanetan, ia espejismo bat sor arazteraino.

Baina direnak direla aztergaiak zehazteko eta gertaerak numerotaratzeko ahaleginak, argi dakusagu Ekonomiak ez dadukala —eta epe luzera ere lortzeko ahalmen urriak— beste zientzia zehatzei urrik ematerik, zeintzukin ez baitu hizkera matematikoaz beste kidetasunik. Zientzia hauetaz diferentki, Ekonomiak ez ditzake ari den fenomenoen parametro guztiak ezagutu. Kontaduria nazionalak berak ere lanak ditu gaur; baina ehun bider gehiago eduki behar nazioko errentaren egikeran edo banakeran sartzen diren faktore guztiak kontuan hartzekotan. Gainera Ekonomian

ez dago joaniko esperientziak errepetitzerik: 1936, 1944, 1958 behin bakarrik esistitu ziren —eta esistituko ere—: Historia ez dago ekonomistek beren beren ekuazioak noiz prest edukiko zain. Hirugarren diferentzia benetako zientziekin: oso erraza da —hauxe da izan ere politika ekonomikoaren zera— esperientzian zehar prozesoaren desarroilo kondizioak aldatzea: zerga nahiz prezio aldatze gehitxoago, aduana-eskubide nahiz presupostu-gastu gutitxoago, eta horra kolpera aldatuak azterturiko prozesoaren ondorioak. Ez dago, bada, zer gertatuko den zehazki igartzerik —eta hau, aitor dezagun, nahikoa "izorragarri" izan "zientzia" batentzat—. Debaluazio bat garaitia ala frakaso gertatuko? Merkatu Batuak ondorio onak ala xarrak ekarriko? Pronostiko bat arriskatzen dutenak hain sarri erratzen dira non beren teknikaren zehaztasunik eza nahi eta ez onartu behar.

Hala ere, maiz entzun ohi da "lege ekonomikoen" kontua. Zer esan honi buruz? ezepziotxo batzuz aparte, ez dira zientziazki egiztaturiko konstatazioak, huts gabeki atereak —presenteon nahiz geroan— aurretik hautemaniko fenomenoetatik (nola baita ura berotzean baporatzea). Gehienez ere "joerazko" legeak dituzu eta jeneralean zentzuzko konstatazioei dagozkienak.

Hona adibide batzu:

— eskaintza-eskarien legea, zeinek, bai baten eskaria eskaintzari nagusitzen zaionean, prezioak gehi arazten baititu eta guti arazten eskaintza haunditzean edo eskaria tipitzean.

— emankortasun gutikorren legea, zeinen bidez —hala lurrean nola fabrikan— inbertsio maila batetik gora (makinak edo abonuak) ahalegin gehigarriaren emankortasuna aurreko ahaleginaren emankortasuna baino tipiago baita.

— errenta nazionalaren banatze legea: ez dago nazio bateko pertsonen edo taldeen artean nazio horretako errentak balio duena baino gehiago banatzerik etab.

Ebidentzia hauk —inoiz berriz esperientziak gezurtatuak— ez dira aski Ekonomiari zientzia deitzeko. Deitura honi eustekotan, —gutienez inportantzia gehiago emateko— beharrezko da "gizarte-zientzia" bat dela argitzea eta beraz zori guztien eta gizarteen portamoldeko zihurgabetasun guztien mende dagoela.

Orduan Ekonomia ez al da teknika bat baizik? Baietz esan daiteke huts haundirik egiteko arriskurik gabe. Gaurko azterketa ekonomikoak mementu eman batean huts-tarte gutiz diagnostika dezake egoera; eta oinarri honekin biderik efikazenak izenda egoerari eragin nahi izatekotan... Esaterako, parorik agertzen bada, denok dakigu lan-leku berriak sortu behar direla. Prezioek gorantzkoari eman badiote, ba dakigu urjentea dela inportantzioa gehitzea. Komertzi-balantza defizitun badago, esportazioak ugaritzea edo atzerriko eroskatak urritzea dateke egokien. Estatuko presupostua defizitean dagoenean, ba dakigu nola kitatu: zergak edo enprestitoak, etab.

Edozein krisis ekonomikok daduka bere soluzioa, edozein helburuk daduzka —bateko bada—

bere kondizioak. Hala ere, beharrezko da teknika ekonomiko honen mugak ezagutzea. Gaurkoz urruti gaude oraindik —inoiz heltzekoa bada, jakina— martxan iminitako bide ekonomikoetatik harako ondorio posible guztiak ezagutu ahal izatetik. Gainera bizitza ekonomikoak planteaturiko problema batzuren soluziorik ezagutu ere ez dugu ezagutzen. Inoiz berriz erabilitako bideek uste zenaren alderantzizko erresultatua ematen dute: esaterako debaluazio batzu biribil atera ziren (Pinay, 1958ko abenduan), beste batzu ordea, frakaso garbia (Gaillard, 1957); ba daude kanpoko komertzioa zuzper arazten duten debaluazioak, beste batzuk ordea, prezioak altzatzea baizik lortzen ez.

Baina Ekonomian inon izatekotan, ez dago helburuak bideetatik banatzerik. Ez daiteke —kanpoko komertzioari begira— debaluaziorik zentzuz desira herriaren bizimailan ekarriko duen osteaz arduratu gabe. Ez dago konpetantzia librearen abantailak dafenditzerik, hark dakartzan "cartel"en arriskuak ere aipatu gabe, baita nolako boteretzarrak lemaizkeen talde finantzari eta ekonomiko nagusiei. Ez dago nazioko errentaren banaketan esku sartze ukatzerik, (edo esku sartze motelez konformatzerik) klase pribilejiatuek gozatzen ari diren abantailei ez-jakin eginik. Ekonomia Politikoa teknika hustzat uztea bere parterik funtsezkoena moztea litzateke; munduko aberastasunen helburua aztertu eta banatutakoan, gehikerarik onena bilatu.

Orduan Ekonomia Politikoa politika hutsa besterik ez al da? Bai, ekonomiko den edozer politi-

ko ere den neurrian: paroa eta enplegu osoa, prezioen garestitze edo merkatzea, etxagintza ala H bonbaren produkzioa hautatu, alokairuen ala irabazien gehitzea lehenago jarri, soldata apalak ala errenta altuak hobetu, errentaren gaineko zergei ala konsumo-tasei lehentasuna eman... Guzti hauek, ekonomia-gai izanez gainera, ba dute proiekzio eta mamia politikorik ere. Bata bestearengandik apartatzea huts nabarbena litzateke edo makurkeria bat.

Hala eta guztiz ere oso gaitza da ekonomia politika huts bihurtzen. Lehenengo, ekonomian hautatzeko askatasun oso meharra delako sarritan. Baina batez ere Ekonomia teknikuko zati bat neutroa delako. Fenomeno ekonomikoen ebaluazio matematikoa bat bera da, dela eskuindar nahiz ezkertiar, dela kolonitzaile nahiz deskolonitzaile, zeren, eskuindar nahiz ezkertiar, diagnostikoak dioena bat bera izan daiteke, baita haren azalpen grafiko eta estadistikoa ere. Diferentziak gero hasten dira: erremedioen eta konponbideen aukera politikoan hain zuzen.

Hauk honela, ez zientzia-zientzia bat, ez teknika huts bat, ez guztiz politikaren alderdi bat ere ez izatekotan, zer da orduan Ekonomia?

Lehen urreratzez esan genezake gizonaren gizarteratzeko modu baten azterketa dela. Gizarteratze honek era batera helburu batzu eduki behar ditu (alderdi politikoa) eta teknika batzu (nola jokatu jarritako helburuak lortzeko, zer kondiziotan, zer ondorio preikusi beharko diren, etab).

Zertan esanik ere ez Ekonomia ez dela gizona

gizarteratzeko modu bakarra. Ba da besterik; modu filosofiko edo etikoa (nahi bada erlijiozkoa), gure problema nagusi bakoitzean bizitza-heriotzen zentzua, gizartearen papera... gidatzen dituena. Ba da gizona gizarteratzeko modu estetiko bat ere: gizonaren eta gizartearen arazoa ederraren eta hura lortzeko bideen bila.

Gizonaren gizarte-bizitzan sartzeko modu ekonomikoa gizonaren produkzioarekiko harremanei dagokiena da, ondasunen eta zerbitzuen konsumoa, beren trukea, eta gainera gizartearen antolakera produzitzeari, konsumitzeari eta trukatzeari buruz.

## III. PROBLEMA EKONOMIKOEN ETA BEREN ZAILTASUNEN ADIBIDE BATZU

Inguru-minguru luze hauen ondoren, ordua da gagozkion gaia argitzeko. Bide batez era dukezu eten gabe ekonomiagintzan ari zarela eta eta hau orobat teknika eta politika dela zihurtatzeko. Has gaitezen gai erraz batekin, problema ekonomikorik nagusien batzu ager dakizkigun elkarri loturik. Gainera ikusiko dugu nola hoietariko edozeinek planteatzen dituen dilemak, gutariko bakoitzak XX-garren mendeko humanismoaz daduzkan usteen funtzioan izan ezik erabaki ezinekoak.

Hona gaia: esistitzen gara eta beraz bizibideak lortu behar ditugu. Eta nola gizartean bizi baikara, gizartea da premia hauk asetzeko behar di-

ren bideez hornitu —produzitu, alegia— behar duena.

Lehenengo puntua: konsumitu egin nahi dugu. Lehenengo aukera-sailak: Zer, zenbat?

Gure konsumo-nahiak asetzeko honelako eta horrelako ondasun-zerbitsuak behar ditugu. Batzu bakar konsumokoak dira: janari, jantzi, kultura, bakar dibersioak; beste batzu elkar konsumokoak eta elkar-bizitza osotzera destinatuak: bizitzetxe, eskola, hospitale, antzoki, gizarte eta administrazio zerbitsu. Premia hauk —denak bidezkoak— asetzeko, azpiestruktura ekonomiko galanta behar da: fabrikak derrigorrezko dira nekazaritza desarroila arazteko traktoreak egiteko. Beste fabrika batzuk tresnak emanen dituzte eta hauek, sailkaturik eta industrian prest iminirik, beharreko konsumo-ondasun industrialak produzituko dituzte. Etxe, eskola, hospitale eta antzokigintzak material-gastu izugarriak behar dituzte konztrukzio arloan. Jo itzazu gero inbersio nagusiak, trenbide eta ibai-sareak, karreterak, aireportuak, etab ugaritzeko eta hobetzeko beharrezkoak, hauk beharrezko direlarik pertsonak, materialak eta produktoak behar den tokira ahalik azkarren ekar-eramateko.

Laburpenez —eta adibide huts bat duzu, ez zenbaketa zehatz bat— edozein produkziori buruz argi dakusagu lanak daudela hain premia gostutsuak asetzen Denak kolpera asetzerik ez dagoenez gero, hautatu egin behar zein, eta honela janaritan enplegaturiko dirua ezin ia jantzitara, etxetara, irakaskintzara dedikatu. Halaber nazioak lehenagotzat dadukan hain helburutara destina-

turiko dirutzak ezin ia beste ezertan erabili. Eten gabe planteatuko zaiku hautatze problema, hala bakar mailan nola elkarrekikoan.

### *Nork erabakitzen du konsumo-Premia hauetatik zein?*

Bakar mailan gure aukera bi elementuk baldintzen du: gure errentak eta beharrezko zaizkigun ondasunen edo zerbitzuen prezioak. Beraz konsumoaren eboluzioaren arrazoiak ulertu nahi dituen ekonomistak alderdi bikoitz hauxe aztertu beharko. Errentak aztertzeak esan nahi du jakiteaz arduratzea nolakoak diren (eta nolakoak izan diren) mementu eman batean alokairuak, profesio liberalen sarrerak, nekazarienak, ugazaben (komerzio eta industria) irabaziak eta artisanoen sarrerak. Era berean eta derrigorrez bilatu beharra dago zergatik diren sarrerak hain desberdinak (hilean mila batzu franko bakarrik jubilatu batek, 45.000 erdiko langileak, miloitik gora ugazaba haundiak) eta zergatik eboluzionatzen diren hain desberdinki (esaterako 1957-tik 1960-ra alokatuen eta funtzionarioen sarrerak —a fortiori jubilatuenak eta pentsiodunenak— askoz nekezago gehitu dira merkatari, industrial eta profesio liberalik ejerzitzen dutenenak baino).

Eboluzio hau, jakina, prezioenaz konparatu behar da. Hauek alokairuei aurrea hartu diete ala alderantziz? Zergatik gehitzen dira prezioak? Zeintsu elementu sartzen dira beren egikeran? etab. Ekonomistak, guzti hau zehaztutakoan ere, ez duke oraindik inolako zihurtasunik ea ase nahi

ziren premiak benetan aserik dauden ala ez orain. Eta talde sozial bakoitzean konprobatu beharko lehen premietarik zer zatik dirauen bertan behera eta zati hura nola ase litekeen bilatu.

Maila politikoan, hots, gizartezkoan, aginte politikoa da konsumo premien artean hautatzen duena, zeren bakar aukerak biltzeaz konformatu ez ezik, bidetu, eraman egiten baititu, batzu gehituz eta bestetzu gutituz. Ikusirik dugu nola, gastu publikoen bitartez, konsumo batzu bultzatzen dituen eta eskari batzu gehitzen: eskolak, baina baita abioiak eta bonbak ere; hospitaleak, baina baita karreterak, funtzionarioen irabaziak, errenta mugatuko bizitzetxeak, administrazio-etxeak etab ere. Zergen bidez ordea, erosketa batzu gutitu egiten ditu: dela honen edo horren produktotan eskua sartuz (grabamen astunagoa gasolina, tabako, tresna elektrodomestiko eta luxozko gaiei; bataz-bestea baino tasa apalagoak janari, gaz, ikatz eta elektrikari; esonerazioa ere bai produkto batzuri: esne, ogi...), dela konsumitzailearen esku-errenta globalki gutituz, bere irabazi zati bat —zenbatasunaren proportzioz— errentaren gaineko zergaren bidez deskontatuz.

Estatuak ba du oraindik hiritarren lortzeko ahalmenaren beste mozpide bat: inflazioa edo prezioen goratze erregular eta etengabea (diruaren debaluazio bidez). Azpijoko ezkutu bezain efikaz honekin, fidatu zitzaizkion aurrezle guztiak hondatu zituen gerra bien artean. Joko berarekin derrigortu zituen herritar klaseak, 1945-tik gora, beharrezkotik zati bat uztera, fabrika-jabeek —Estatuak eta akzionista pribatuek— gerra bukatu-

takoan industrian inbertituriko presupostu haundiak ahalik lehenen amortitu ahal zitzaten. Zer pentsatu prozedimendu hauetaz, beren efikaziaz, beren bidezkotasunaz?

Gai eta hauzi ekonomikoen zenbaketa huts hauxe ere aski duzu Ekonomia Politikoa izatez zer den kargutzeko. Honela ulertzen da gorago esana, ezineko dela kontu hauk teknika hutsez erabakitzea. Edozein mementutan faktore politikoak dabiltza artean: Nork konsumituko du, zer eta zenbat? Noren konsumoa gutitu behar da beste batena gehitzeko? Noren esku dagoke aukera? Prezioei igoten utziko zaie inbersiorako baliakizunei bitarte gehiago emateko, ala estable iraun arazi, herritarren lortzeko ahalmena zainduz honela? Zer gastu behinagotan enplegatuko da presupostu publikoa eta nola finantzatuko? etab. etab. Faktore politikoen artekotasun etengabeak sobera justifikatzen du Ekonomiari eman diogun izena.

Eta jakina, antzeko egoeran aurkitzen gara bakoitzaren eta nazioaren konsumoa ezagutuz —edo preikusiz— gero, hura asetzerakoan ere. Izan ere produkzioa gidatu egin behar da. Bi adibidez argituko dugu behar hau.

Hamar urtetan haragia urri ibili da Frantzian. Ministroen deiek ez zuten ezer konpondu. Konsumoaren eskariei ezin zitzaionez erantzun, prezioak igon egin ziren. Noizik noizera "xokeko" inportazioek lortu zuten goranzkoa frenatzea, baina apurtxo baterako bakarrik. Alferrik izan ziren harakinei eginiko dei patetikoak: konsumoa erraziotu eta prezioen igoera onartu beharra zegoen derrigor. Beste adibide bat, etxagintza: hamabost

urteotan ministroak eskua bihotzean dutela aldarrika ari zaizkigu bizitzetxe-krisisa dela "gizarte-arazo puntarengoa". Baina nola ez baita behar haina eraikitzen, krisisak iraun dirau hiri-multzoetan, klase herritarren kalterako batez ere. Bistan dago, hala haragiaren nola bizitzetxearen kasuan, ez zegoela, eta ez dagoela, konsumoa nahikotzerik produkzioa gehituz izan ezik.

Hau konsumo guztietarako da egia. Honela bada, edozein produkziori datxeko elementu batzu martxan jarri beharra eta denak finantzatu beharrekoak. Har dezagun adibidetzat automobilen kasua. Hona zenbat gauza behar den 2 CV soil bat fabrikatzeko:

— lehengaiak: altzeiru, kautxu, oihalak, gai plastikoak. Hauen produkzioak beste gabe mina ikerkuntza luze eta gostutsuak behar ditu, meatzen esplotazio-lan zailak, transformazio etapa industrial mordo haundi bat. Operazio pilo honek 10, 15 eta 20 urte ere lehengo hastea eskatzen du sarritan, masako produkzioa lortu aurretik.

— fabrikazio sistima egokiei dagozkien makinak (enpresa produktoreak beste sistimarik asmatzen ez duen bitartean inoren aurkikundeak hartu behar: patenteen alkilerra). Makina hauk aterbetzeko anitz eta anitz nabe behar da.

— teknikak preparaturiko laneskua.

— anitz transporte-bide lehengaiak fabrikaraino garraiatzeko eta gero klienteak hornitzeko.

— finantza-bide izugarriak, ez bakarrik gastu mordo honi erantzuteko (zergak gainera), baizik

baita noiznahi edukitzeko ere sor litezkeen ustekabeetatik defenditzeko moduko kutxa-gaitasunak (salmenten gutitze, zergen ordaintze, kredito bereziki astunen bentzumenduak etab.).

Adibide honexekin bakarrik ikus dezakezue nola edozein ondasun-motaren produkziok plantea ditzakeen problema ekonomikoak, baita nola oso aurretik ibili beharra dagoen ere gaurko ekonomiak eskatzen dituen ondasun guztien —ekipozkoen nahiz konsumozkoen— produkzioa behar bezala garantitzeko. Orain konpreni dezakezue zergatik lehenago edozein planifikaziori muzin egiten zioten nazioetan ere (enpresa pribatuen interesen eta funtzionamenduaren etsaitzat jotzen zutelako) orain plan urtetsuen premia sentitzen den. Frantziak eboluzio honen adibide apartekoa ematen du, geroago berriro esanen dugunez.

Baina zuek arrazoiz galda dezakezue nola lortzen den hasieran aipatu ditugun konsumitzaileen desiren eta izenda berri ditugun produkzio-ahalmenen arteko armonia, egokiera. Adibide erraz batzukin saiatuko natzaizue problema ekonomikoen hirugarren sail hau argitzen.

Frantziak beti eduki du bere lurrak eman ez dietzakeon lehengahien beharra (meak, oihalgintzako lehengaik, jangai bruto transformatzekoak...) eta hamarkada batzutatik honantz ekipozko eta makinazko ondasunik ere ez du behar haina produzitzen. Beraz atzerritik erosi behar eta horretarako atzerriko dirua —"dibisa" famatuak— eskuratu behar ordaintzeko: libera esterlinak alkotoirako, dolarrak, markoak eta lirak makine-

riarik gehienerako, florinak gurinerako, etab. Dibisa hauk Frantzian bertan eginiko (edo uztaturiko) gaiak salduz eskuratuko ditu: ardoa Amerikara eta Alemaniara, makinak libera esterlindun nazioetara, moda-gaiak eta altzeirua "dolar" aldeko laterrietara, etab.

Zertan esanik ere ez xit harrigarri litzatekeela atzerriko sal-erosiak berdin berdinak izatea. Gehienean desnibel bat egon ohi da: komertzio-gainkia (salmenten superavitik bada) edo defizita (erosketak gehiago badira). Defizitezko saldoa kitatu egin behar da: edo stocktzat eduki ohi diren atzerriko dibisekin (Frantzian urre eta dibisa "erreserbak" Frantziako Bankuak daduzka) edo atzerrira prestatuz eskatzen direnekin (stocka agorturik dagoenean). Honela bada, hiru kasu gerta daitezke:

— defizitezko komertziodun nazioak bere independentzia politikoa alienatzea onartzen du Estatu arrotz batek damaizkion dibisen trukez: Hauxe izan zen Frantziako kasua gerra osteko urteetan. Orduan beharrezko dolarrak fin-finki hartzen zituen osaba Sam-engandik (Marshal plana, gero Indotxinako gerraren ordainketa, azkenez Bourgès-Maunoury eta Gaillard-en gobernuei emaniko laguntza). Frantzia bere aldetik Washingtonek ezarritako Atlantiku-politika aldetzera konprometatzen zen, eta hala beste amore politiko batzu, nola adibidez, etxagintzaren gutitzea 1957-n.

— defizitun nazioak bere komertzioa berenez partu nahi du laguntza arrotzik gabe eta harta-

rako bere atzerriko erosketak moztu egiten ditu nazio haiekiko salmenten mailaraino. Honela jokatu zuen Pfflimlin-ek 1957-58-n. Baina gehienean neurri honek nazioko aktibitate ekonomikoaren moteltzea eta hiritarren, batez ere pobreenen, bizimailaren beherakuntza dakar.

— defizitun nazioak bere xanpona debaluatu egiten du atzerriko salmentak indartzeko eta bere erosketekin berdintzen saiatzeko. Pinay-k 1958-ko abenduan hauxe egin zuen. Neurri honekin esportagaien prezioa (atzerriko dirutan) gutitu egiten da. Esaterako 500.000 franko balio izanik, 1.200 dolar (dolarrak 420 franko balio zituenean) zen 4 CV bat 1.000 franko bakarrik da Pinayk frankoa 17 % debaluatzen duen mementoan (dolarra 420--tik 500-ra pasatzen da). Baina debaluazioak bizigostuaren igoera dakar bat batera. 1959-n igoera hau 10 % inguru izan zen eta ondoriotzat sarrerak 10 % baino askoz gutiago gehitu zitzaizkien guztien (alokatuen, familien, jubilatuen) lortzeko ahalmena gutitu egin zen.

Agiri denez hiru formula hauetariko bakoitza aukera politiko bat da: atzerriari buruz alienatu, nazioko aktibitatea gutitu ala prezioak igon arazi (klase herritarren bizimaila urriturik).

Nazio batek bere ekonomia elikatzeko nahi dituen atzerriko ondasunak merke lortzearren —edo konserbatzearren— gerrara jotzen duenean, nazioko konsumo-produkzioen arteko ekilibrioak, kanpoko komertzio jokoaren bidez, a fortiori hartzen du aparteko jite politikoa. Hauxe izan zen anitz kolonia-gerraren sorrera; hauxe izan zen

duela urte batzu Estatu Batuen Guatemalako indar kolpearen sorrera (United Fruit-en edukiei eusteko); hauxe da Beljikaren Kongoko jokabidearen arrazoia (Katangaren alde, mina-elkarte belgen hesia); hauxe izan da anitz urtetan Guy Molleten eta De Gaullen Aljeriako politika ere: Saharako "frantziar petrolioari" eutsi.

Kanpoko komertzio problema konpondutakoan, nazio barreneko konsumo-produkzioen eta errenta indibidualen eboluzio desberdina, inflazioa, zergak, presupostu-gastuak. Hauen alderdi politikoa nahikoa argitu dugunez gero, ez diogu gehiago ekinen.

Laburpenez, lehen parte honetako helburua lortu dugu nazioko premien asetze prozesoari errebista pasaturik eta hala nazioari entitate gisa nola bertako pertsona bakoitzari agertzen zaizkion problema ekonomiko nagusiak gure aurrean desfila arazirik. Aktibitate ekonomikoan eten gabe jokatzen ari bagara ere, problemen zabaltasunak eta artean dabiltzan pertsonen askotasunak gutariko bakoitzaren parte hartzea ezer gutitan uzten dute. Honela esplikatzen da hasieran genioen sentimendu bikoitz hura: bizitza ekonomikoaren erdi erdian aurkitzen garela (gerauk eragiten diogu eten gabe) eta hala ere gainezka egiten daukula ikusi behar (planteatzen dituen problemak hain asko eta zailak direlako).

# IV. KONKLUSIOAK GOGOETA GISA ARAZO EKONOMIKOEI BURUZ

Aski litzateke ukitu ditugun hauzietako zehetasunak pizka bat astintzea bizitza ekonomikuko nahasitasuna argi geratzeko. Fenomeno ekonomikoen neurri eta azter tresnak zehatzagotu ahala berriz, hainbat eta nahasitasun zorrotzago agertzen zaiku. Horregatik ez da harritzeko mila liburu ekonomiko argitaldu izatea eta hala ere ekonomikoak deitu ohi zaienen berri eman zuei, zentzietako "legeei" legozkienak— oraindik ondo argitzeko egotea. Gainera urrengo kapituluetan zehar dukegu hauzi hauetariko batzu berrikusteko era.

Gure lehen helburua apalago zen: arazo ekonomikoak deitu ohi zaienen berri eman zueri, zenbat ukitzen zaituezten eta zuek berei zenbat eragiten diezuen erakutsi. Helburu hori lortuko al genuen. Bukatu aurretik bi gogoeta nahi nituzke jarri.

Lehenengo nolako konfliktoen berri damaikun hauzi ekonomikoen ikasketak. Ikusi dugu zer konflikto dakarren aipaturiko problema bakoitzak: ugazaba-alokatuen arteko konfliktoak lanaren frutuen banaketan; produktore-konsumitzaileen arteko konfliktoak prezioak gorago ala beherago jartzerakoan; gizarte-klase batzuren (nazioko errentan parte gehiago edukirik hobeto bizitzeko gogoa dutenen) eta beste talde sozial pribilejiatu batzuren (beren bizimaila altuari eustea eta gehitzea nahi dutenen) arteko konfliktoak; zergapeko

edukitsuen eta konsumitzaile tipien arteko konfliktoak, haik konsumoaren proportzioko tasen aldeko eta hauk klase modutsuen errenta-zerga progresiboen aldeko; inflazioa ongarri zaienen eta kaltegarri zaienen arteko konfliktoak; nazio aberatsen eta pobreen arteko konfliktoak trukatzen dituzten gaien prezioak izendatzerakoan; etab.

Ez dago eskemakerian erori ezik konflikto guzi hauk bazterreratzerik. Baina egiari marro egin nahi ez bazaio, aitortu beharra dago gehienak zapaltzaile eta zapalduen, esplotatzaile eta esplotatuen arteko konflikto mendetsuen kontuak direla, konflikto hauek XIX eta XX-garren mendeetan klase burrukaren era berezia hartu dutelarik. Inork ez daduka konflikto honi kuku egiteko eskubiderik. Eta inork baino gutiago eskuin tradizionalak, aldizka ezkerraren esistentziaz ahaztutzekoa egiten duena eta De Gaulle jeneralaren ahotik "klase-burrukaren ondorioak likidatzeaz" mintzo dena. Produkzioaz, konsumoaz, prezioez, presupostuaz, zergez, subdesarroiloaz, etab. geroago mintza gaitezenean, berriro agertuko zaiku konflikto batez ere politiko hau.

Bigarren gogoeta da nola ekonomiara bi hurbilkera dauden historian zehar. 150 urteotan pentsamendu ekonomikoa zehaztuz doa. Bi korronte ideolojiko berezten eta gehienean kontratzen ari dira, bien artean polarizatzen delarik eztabaida: korronte bata oraingoxe sistimaren alde dago —den bezal-bezalaxe ez bada ere apur bat ukiturik behintzat— eta sarritan besterik egon litekeenik ere ukatu egiten du, oraingoa gauzen naturatik bertatik honakotzat baitaduka. Kapitalismo

zale hauen kontra daude oraingo sistima (zuzen-gabetzat eta guti efikaztzat jotzearren) gaitzesten eta ordez sozialista erako mekanismo bat onesten dutenak.

Bi korronte hauen arteko oposizioa hiru modutara ager daiteke laburki:

1. Kapitalismoaren aldekoek, ekonomia arloan askatasunari fidantza osoa eman behar zaiola uste dutenez gero, derrigorreko dela diote konsumitzaileari konsumo posible guztien artean bere aukera egiten uztea. "Merkatuko ekonomiaren" aldeko dira, egoera honetan erosteko ahalmen efektibodunak bakarrik sartzen direla joko ekonomikoan eta beraz produkzioa maneiatzen dutela ahazturik. Benetako premiak eduki arren, asetzeko finantza-biderik ez dadukan konsumitzaileak ez du jokoan parterik hartzen: ez zaio eskaririk haintzat ere hartzen, ez dadukalako zerekin.

Sozialistek uste dute arrazonamendu hau pribilejiatuen kontzientzia ona lasaitzeko bakarrik dela. Sozialistek gehienen premiak ase nahi dituzte lehenago, nahiz eta premia hauk asetzeko, nazioko errentaren banaketan, prezioetan eta zergetan beharrezko azpikoz goratze guztiak egin behar. Beraz prozeso ekonomikoan aktiboki esku--sartzearen aldeko dira, merkatuko berezko jokoa alda arazirik.

2. Kapitalismoaren aldekoek produkzioko medioen jabego pribatuari eutsi nahi diote eta hau izatez jabego izugarri hau mila batzuren eskuetan bakarrik konzentratzea da. Ez dagoela jabego

hau aldatzeko inolako beharrik uste dizute, zeren fabrika eta lur jabeek —haundiak izanik ere— merkatuko arauetara makurtu behar omen baitute eskari gaudimendunari erantzuteko.

Sozialistek ihardesten dute gehienen premia biziak asetzeko, industria eta nekazaritza irabazi indibidualak ez beste ardura batek gidatu behar dituela: nazioko kolektibitatea ordezkatzen duten eta denen onerako dihardukaten organismoek izan behar dutela herriko premiak asetzeko eginkizun berezi hau beteko dutenak. Gainera diote esperientziak argi ematen duela nola irabazien ekonomia eta era kapitalistak ez diren ia bat ere gehienen onagatik arduratzen, edo nola, arduratzekotan ere, pribilejiatuen onak eskatzean bakarrik egiten duten. Nazioak behar duena produzitzeko eginkizuna nazioaren mendeko organismoei uztean, ekonomiko efikazago bat taxutuko da, zeren askoz arrazoizkoago, modernoago, berrituago izan ahal baituke (ez dute irabazi-arrazoiek bir-antolamendu hau oztopatuko) eta nazioak hautaturiko ordezkariek emaniko aginduei zehazki men eginen baitie. Ohar arazi beharra dago produkzioaren ardura utziko zaien organismo kolektiboek ez dadukatela derrigor estatukoak izan beharrik. Bitarteko kolektibitateak izan daitezke: departamentu (probintzia), udalerri, herriko edo herrialdeko kooperatiba...

3. Beren buruekin lojiko, kapitalismoaren aldekoek beren aukeraren arriskua onartzen dute: Estatu gauzetan aginte zati haundi bat elkar laguntzen eta taldetzen diren industriadun nagusiei,

lurjaun haundiei eta bankari puntarengoei ematen zaiela aitortzen dute. Aginte hau modu desberdinez agertuko da: hauteskunde kanpainen finantzamendua; presio-taldeek Parlamentu, Gobernu eta Administrazioa zirikatzea; nazioaren oneko erabakiak ez betetzea —negozio askatasunaren izenez—; etab. Jakina hobe dela —diotzute— amore ematea iritzi publikoan sistimaren finkotasuna koloka arazteko moduko eskandaluraino heldu baino lehen.

Sozialistek ordea uste dute demokrazia azpi--janik geratzen dela hiritarrak berdinak ez izatea ametitzen denean. Praktikan berdintasun hau —demokraziaren oinarrizko printzipio— burutzeko era bakarra indartsuen presio-bide hauk kentzea da. Produkzio-bideen sozialtzeak eman dezake hori. Helburua da botere ekonomiko eta politikoa ahalik gehien dezentraltzea eta hiritarrei erantzukizun haundiagoak ematea nazioaren eramantzan. Hauk honela, pentsalari sozialistek bi soluzio sail jartzen dituzte: batetik langileak izatea enpresen eramale eta plan ekonomikoen egikeran parte hartzaile eta kolektibitateen botere politikoak gehitzea zentralizazio administratiboa urriturik.

Adibideen zerrenda hau asko luza daiteke pentsamendu ekonomikuko bi familion oposizioa ikus arazteko. Baina oraingoz aski da esana.

Asko, jakina, dudan daude bi sistimon artean. 160 urtetatik honantz ekonomista hirugarren bide bila ari da. Gure egunotan "teknokratak" deritzatenak —goi-funtzionarioak, enpresa pribatu haundietako koadro nagusiak— maiz saiatzen dira ka-

pitalismo-sozialismoen arteko dilemari ihes egiten teknikaren lehentasuna afirmatuz. Esaka ari zaizkigu —pizka bat xoriburuki noski— kapitalismo "konzertatu" edo "berritua" azken batez sozialismo "leunduaren" eta Estatuaren morrontzapetik askatuaren berdina dela. Hau hitzekin jokatzea besterik ez da, burua garbi agertu beharrik ez edukitzearren. Zeren bi sistimen eboluzio historikoak diferentzien batzu leundu dituelarik ere, funtsean diferentziek hortxe diraute eta berriketa eta neologismo jarioak ez ditu, ez, eliminatuko.

Hain egia da hau non, duela denbora bat, Frantzian berton gertatua baita pentsamendu korronte garrantziatsu batek, bere buru batzu ari garen teknokraziatik hurbil egonik, anitz dudaren ondoren sozialismoarekin bat egitea. Pierre Mendes--France aitzindari duen korronteaz ari gara. Dudarik ere ez, bateratze hau dudan jarri zuela sozialismo kontuan P. M. F. baino zorrotzago zen anitz sozialistak. Baina dena dela, erdiko klaseen eta iritzi kapitalistetatik hurbilagotzat —akaso ohitura hutsez— jo izan diren koadroen sozialismoranko eboluzioaren adierazle da.

Oso zaila da eboluzio honek iritziaren orotasunean zer eragin numeriko dadukan kalkulatzea. Baina aipaturiko kasuak ba du noski test-baliorik biztanleria frantzeseko zati ez edonolako batentzat. Kondizio politikoak alde jarritakoan —esaterako ezkerrera itzultzea gaullismo ostean-ba liteke eboluzio honen gailurtzat, hautesle mordo haundi batek ezkerrerantz jotzea.

# BIGARREN KAPITULUA

## FAMILIAKO PRESUPOSTUA ETA AHALMENAREN EBOLUZIOA LORTZEKO

Bigarren kapitulu honetan zehazkiago ikusiko ditugu errealitate ekonomikoak. Honela bada, Ekonomia Politikoaren panorama zabal bat zirri-borratu, ondoren, azter ditzagun hurbilagotik Ekonomiako fenomenorik aurrenak.

Batzu jendeari ezagunak zaizkio, hizparringietan irakurtzen baita prezioak gorantz doazela oraindik, edo hain fabrikatan lanorduak gehitu edo gutitu egin dituztela, edo honen organizazio sindikalek edo horren familia-elkartek agiri bat atera duela prestamen familiarren edo sozialen jelatzearen kontra edo halako lanordu edo asignazio gutitzearen kontra, etab.

Jendeak ezagun dituen errealitate hauek bi problema nagusi planteatzen dauzkigute, orain argitzera goazenak. Zergatik ez da bizimaila hiritar

guztientzat berdina eta zergatik da bizimailaren eboluzioa hain desberdina talde sozialetan zehar?

Hauzi hauk erabakitzeko lau problema aztertu behar elkarren atzean: lehenengo zeintzu faktorek determinatzen duten familietako bizimaila; gero zeintzu arrazoigatik eboluzionatzen diren diferentki talde sozial desberdinetako bizimailak; ondoren zeintzu bide daduzkaten alokatuek sarrerak gehituz bizimaila hobetzeko; eta azkenez, aurrekoa biribiltzeko, zeintzu bide daduzkaten alokatuek bizigostuaren gehitzea eragotziz, egoera hobetzeko. Lau zatiok banaka aztertuko ditugu.

## I. ZEINTZU FAKTOREK DETERMINATZEN DUTE FAMILIETAKO BIZIMAILA?

Familietako bizimaila beren irabazien eta hauekin eros ditezkeen ondasun-zerbitzuen prezioaren pentzudan dago.

### *Zeintzu dira familitako errentak?*

Oso arraro da familia batek errenta eredu bakarra edukitzea. Kasurik gehienetan familia bakoitzak bi errenta mota ditu: errenta zuzena, direktoa, alokatuentzat alokairua dena, nekazarientzat lur-lantzako produktoa, merkatarientzat komertzioko irabazia; eta errenta diferitua: prestamen familiarrak, segurantza sozialeko errenboltso bat, jubilazio bat, pentsio bat, etab. "Diferitu" deitura honek beraz, lana egin eta askoz geroago

ordaintzen dela esan nahi du, lanarekin zerikusi zuzenik gabe. Honetantxe da hain zuzen errenta zuzenetik desberdin.

Errenta diferituak eta errenta zuzenak familiako errenta osoaren barrenean dadukaten proportzioan, alde haundia dago zer familia den eta eta zer irabazpide hartzen den. Lehenengo, edadearen arauera: zaharren errenta nagusia jubilazioa da, helduena berriz alokairua, errenta zuzena. Familiaren osakerak ere asko alda arazten du proportzioa: ezkongabeak errenta zuzena bakarrik hartzen du, prestamen familiarrak direlarik familiako errenta-zati haundi bat (33 % hiru seme--alabadun langilearentzat eta ia familiako errentarik erdi bost daduzkan langilearentzat). Osasunak ere ba du zerikusirik proportzio honetan: seguratu sozial osasuntsu batek bere errenta zuzenetik (alokairutik) zati bat segurantza sozialeko kutxara sartzen du, honek errenta diferitu bat (indemnizazioak eta errenboltsoak) izendatzen dielarik gaixorik daude langileei.

Errenta zuzenaren eta errenta diferituaren arteko proportzioa bakoitzaren maila sozio-profesionalari ere ba dagokio: esaterako alokatuek beren errenta osotik 22 % prestamen sozial eta familiar gisa hartzen dituzte, nekazariek ordea, 9 % bakarrik. Halaber zein industria adarretan lan egin, proportzioa aldatu egiten da: esaterako mineroen errenta osotik 24 % presamen familiarrak eta sozialak dira —legegintzak bereziki faboraturiko profesioa izaki—, prestamen hauk ordea, industria elektrodomestikuko alokatuen 18 % baino ez dira, errenta zuzen haundiko maila soziala izaki. Erren-

ta zuzenaren eta errenta diferituaren arteko proportzioa garaitik garaira ere aldatzen da: 1956-tik 1960-ra prestamen familiarrak (errenta diferitua) guti gehitu ziren, alokairuak ordea (errenta zuzena) askoz azkarrago igon ziren, 30 %-ko aldea kendurik. Azkenez naziotik naziora ere aldatzen da proportzio hau: esaterako Alemanian errenta diferitua alokairuen 15 %-tik 25 %-ra bitartean dabil (industriaren arauera), Frantzian ordea, proportzio hau 25 %-tik 30 %-ra dabil eta 30 %-tik 40 %-ra Italian, non ordaintzen baitira Merkatu Batutko alokairurik tipienak.

Orain arte familiak, errenta tipidunak edo erdizkodunak, alokairu zuzenez gainera errenta diferitu bat ere hartzen duen kasu errazaz mintzatu gara. Gaineratu beharra dago gizarte-klase batzuk errenta zuzen klase bat baino gehiago hartzen dutela. Esaterako Frantziako "familia nagusi" ereduak, negoziodun burjeseriak, era batera aitaren alokairu ederra kobratzen du (enpresa haundiren bateko zuzendari, kontseilari edo jerente) eta gainera elkarte honek (edo beste talde kapitalista batzuk) izendatzen dizkion ehuneko honenbestekoak, eta gainera karteran daduzkan akzioek urtero damaioten dibidendo mordoa eta azkenez familiaren lur edo esplotazioetatik datozkion irabazi edo lur alkilerrak. Sarritan berriz errenta hauei seme-alaba nagusien alokairuak erantsi behar zaizkie. Modu gutiagoko familiek ere bil dezakete errenta batetik gora: esaterako, senar-emazteek lan egiten duten etxeetan; Sochaux-ko langileak, era batera automobilgintzako langile eta nekazari

denak, bere metalurjiko alokairuari lurretik harako errentatxo bat gaineratzen dio.

Bukatzeko esan dezagun familietako errentak xit bariatuak direla eta errenta diferituen kalitatea oso desberdina kategorien arauera. Guztira, errenta diferituak frantziar familia alokatuaren errenta osotik laurden bat dira. Proportzio hau askoz haundiago da alokairu apaldunen familietan (alokairu apalengatik hain zuzen) eta familia ugarietan (prestamen familiarren kopuruagatik).

*Prezioak*

Ez da nahikoa familia bateko osoa jakitea zer bizimaila dadukan jakiteko. Bizimaila hala familiako errentaren nola familiak erosten dituen ondasun-zerbitzuen prezioen mende dago. Izan ere errenta konstantez, familia bateko bizimailak gutitu egin behar prezioak igotean, edo gehitu prezioak beheratzean. Beraz bizimailak, edo nahiago bada, lortzeko ahalmenak konparatzekotan, beharrezko da errenten eta prezioen eboluzioa era batera konparatzea.

Hona adibide batzu: 1945-tik 1950-ra prezioak alokatuen errentak baino azkarrago igoten dira. Alokatuen lortzeko ahalmena gerra aurrekoa baino askoz tipiago izateraino gutitzen da. Alokatuen eta jubilatuen bizimaila gutitze honi eskerrak Frantziako ekonomiak bere hornitura industrialaren eta bere azpiestrukturaren berrikuntza finantzatu ahal izan zuen gerra ostean.

Baina 1951-tik 1955-ra prezioak ahulki igoten dira, alokairuak ordea, askoz bizikiago. Pizkana-

ka alokatuek lortzen dute gerra aurreko lortzeko ahalmena harrapatzea eta jeneralean gaintzea ere. Hau probintzietarako da batez ere egia, baina ez ahaztu errenta zuzenak gainera alokatuek harturiko eta gerra ostean asko gehituriko errenta diferitua dagoela (prestamen sozialak eta familiarrak).

1956-n prozesoa geratu egiten da. Udaberrian eta udan prezioek, izozteengatik batez ere, aurrea hartzen diete alokairuei. Alokatuen bizimaila beraz beherantz hasten da. Udazkenean alokairuak prezioen pare jartzen dira. Urtea osoan harturik beraz, ekilibrioa mantendu egin da.

Baina Aljeriako gerraren eraginez, 1957-ko udatik gora prezioak geroago eta agudoago igoten dira 1959-ko udaberrirarte. Prestamen familiarrak ia gogorturik diraute eta alokairuak oso urrutitik darraizkio prezioen eboluzioari. Langile familietako bizimailak beherakada haundia egiten du. Bataz beste, langile familien lortzeko ahalmenaren atzerakuntza 6 %-tik 10 %-ra da 1959-n 1957--ko udari buruz, atzerakuntzaren zenbatasuna seme-alaben numeroaren arauera aldatuz. Gainera nola industrietan eta probintzietan lanorduen gutitzea zorrotzago izan baita, bizimailaren beherakuntza bataz-bestea baino askoz gogorrago izan da.

1959-ko udaberritik gora alokairuak prezioekin berdinduz doaz pizkanaka, baina prestamen familiarrak geldiro gehitzen dira oraindik, urtean igonaldi baten —edo biren xit noizik behin— ritmora. Honela 1960-ren azkenerantz, langile familien bizimaila oraindik 3 % tipiago da 1957-ko udakoa baino. Familia ugariek eta Estatuko edo enpresa

nazionalduetako funtzionarioek berriz are bizimaila kazkarrago dute, alokairuek ez baitzuten eboluzio uniformerik segitu.

Adibide historiko hauek sobera darakusate zer inportantzia dadukan errenten eboluzioa prezioen eboluzioarekin elkartzeak. Diskurtso ofizialetan alokairuen altzatzeei bakarrik ekiten zaie satorki, botere publikoek bizigostuaren gehitze parekorik sekula aipatzen ez dutelarik. Guk argi ibili behar dugu alderantzizko tentazioan, aurrekoa bezain gezurrezkoan, ez erortzeko: prezioen gehitzeei bakarrik ekin era batera egon diren errenta gehitzeak isilduz.

Gure hitzaldiaren puntu honetan honako hauzi hau planteatzen zaiku: Nola neurtu prezioen eboluzioa? eginkizun inportantea, esanda dadukagunetik, gehienean indizeen laguntzaz egin ohi dena. Produktoen (edo gaien) listak egiten dira hileroko prezioak ezarriz. Produktoak ezkongabe baten edo erdiko familia-eredu baten hileroko gastuen arauera hautatzen dira.

Frantzian sei indize sail haundi daude. Sail ofizialak bere aldetik beste bi sail hartzen ditu: 179 gaitako indizea, alokairu minimo interprofesional garantitua (S. M. I. G.) osatzeko balio duena eta bizigostuaren eboluzioa nahikoa dezehazki adierazten duena, konsumo arrunteko gai batzu falta baitira bertan; eta 250 gaitako indizea, gaur egun bizigostuaren indizerik onena Frantzian (lastima galanta S. M. I. G. indize honen gainean ez atontzea). Indize ofizial hauetaz gainera beste bost indize pribatu daude. Lehenengo, organismo sindikalek kalkulaturiko indizeak: C.G.T., C.F.T.G.,

F.O. C.G.T. indizeak itun kolektiboetako batzorde nagusiak 1950-n jarri zuen eta peoi-eredu baten, "Zephir" famatuaren gastuei dagokien presupostu-ereduari segitzen dio. Indize sindikal hauetaz gainera Institut d'Obserbation Economique-ko (I.O.E.) bataz besteko indizea aipatu behar, zeinek biltzen baitu I.O.E.-k berak kalkulaturiko lau indizeen bataz besteko eboluzioa (lau indizeok peoien, langile espezializatuen eta koadroen gastuei dagozkie) baita L'Union National des Associations Familiales-koa (U.N.A.F.) ere, familiako gastuak biltzen dituen bakarra.

## II. BIZIMAILAREN DESBERDINTASUNAK ETA BERE EBOLUZIO DESBERDINA

Ikus berri dugu nola bizimailaren eboluzioa errenten eta prezioen mende dagoen. Bistan dago beraz, familiatik familiara bizimailaren eboluzioa diferentea datekeela batek edo bestek erositako gaien prezioak diferentki eboluzionatuz gero edo familietako errentekin antzekorik gertatuz gero.

*Prezioak desberdinki eboluziona daitezke*

1960-ko irailean I.O.E.-k peoi batentzat kalkulaturiko presupostu-eredua 2,7 % gehitu zen aurreko hileari buruz, pasta, ogi, metro, autobus, arraultze, xahal xerra eta abarren igoteagatik. Denbora honetan ordea, I.O.E.-k berak kalkulaturiko koadro zuzentzaile baten presupostu-eredua

apenas aldatu zen. Zergatik? Koadro zuzentzailea lanera bere kotxean doalako soilki eta metroaren edo autobusaren igoerak ez diolako ukitzen. Gainera pasta eta xerra guti jaten duelako. Gai hauen prezio igoteek ere ez diote ukitzen; modu gutiagoko familiek ordea, sarriago konsumiturik, edozein aldakuntzari igarri behar. Honela hile honetantxe bakarrik peoien bizimaila 2,7 % jautsi da koadroenari buruz.

Dudarik gabe kasu bakarra dugu hau xit mehazki gertatzen baita honen biziki honen ebolužio desberdinik. Baina adibide honek garbi erakusten dauku zer inportantzia dadukan Gobernuak indize ofizialetako gai batzuren prezioetan eskua sartzeak, igoera ahulago dela sinets arazteko. Gogoan dadukagu nola 1953-n Pinay jaunak esnearen koipeki portzentaia aldatu nahi izan zuen, esnearen prezio igoterik indizean ager ez zedin. Halaber 1956 eta 1957-n Ramadier-ek indizeko gaien prezioak 30 bider aldatu zituen subentzioen eta esonerazio fiskalen laguntzaz bakarrik. Baumgartner jaunak artikulu berdinetara jo zuen 1960-n: gazaren prezioa jauts arazi zuen diruz makalentzat, 179 gaien indizeak haintzat hartzen duen tarifa bakarra delako.

Metodo hauk ez dira teknika ekonomiko gehiegizkoak baina anitz gobernuri lagundu diote ekaitz zailei ihes egiten eta eragozten, prezioen indize ofizialak mementuz inguraturik, S.M.I.G.-ren gehitzea, alokatuek eskubidez itxadoten zutena eta bizigostuaren benetako igotea kitatuko zuena noski.

Baina prezioen eboluzioko desberdintasunak ez dira bizimailen eboluzio desberdinaren errudun bakarrak.

### *Familiako errentak ere desberdinki eboluzionatzen dira*

Izatez hauxe da familietako bizimailaren eboluzio desberdinaren arrazoi nagusia. Jar ditzagun adibideak.

1957-ko udaberritik 1960-ko udazkenera sektore pribatuko langile familien errentak (frankotan, jakina) 26 %-tik 28-rako bataz-bestez gehitu ziren, langile ezkongabeenak ordea, 33 % gehiturik (prestamen familiarrei zegokien frenorik ez sentitzean). Denboraldi berean funtzionario familien bataz besteko errentak 24 %-tik 30-ra gehitu ziren, gutitxoago beraz, eta sektore publikuko langileenak 20 %-tik 24-ra, are gutiago beraz. Baina denbora berean ez-alokatuen errentak 40 %-tik gora gehitu ziren eta honek esan nahi du, nekazarien errentak oso ahulki gehitu zirela kontuan harturik, klaserik modutsuenen, ,ugazaba, akzionista, merkatari eta profesio liberalen errentak ia 45 %-tik 50-rainoko gehitzea ikusi zutela.

Errenten eboluzio desberdin honek, prezioenarekin konparatzean, argi ematen du 1957-tik 1960--ra familia herritarren lortzeko ahalmena 2 %-tik 8-ra gutitu zela (seme-alaba numeroaren arauera) eta gutitxoago nekazarientzat. Beste maila sozialen bizimailak, ordea, gorantz egin zuen. Zer argibide hoberik hasieran berdintsu zirudien ebo-

luzio batek maila sozial desberdinetako bizimailen artean diferentzia nabarbena dakarrela ikusteko.

*Beraz familietako bizimailak oso desberdinak dira ia*

Jar ditzagun ikus arazteko adibideak. Estadistika fiskalek honako dato hauk damaizkigute: Frantzian egoiliar dauden hamairu miloi familiatatik sei miloik ez du irabazten errenta-zergaren gai izateko haina. Hauen artean 3.600.000 langile zahar daude hilean 13.000 frankorik ere hartzen ez dutenak. Zerga ordaindu beharreko beste zazpi miloi familien artean miloi bat eta erdik hilean guti gora behera 50.000 frankotako errenta daduka eta 1.600.000-k hilean 50.000-tik 75.000 frankotara. (Datoak 1958-ko estadistiketakoak dira).

Urte berean 23.500 zergapekok hilean 500.000--tik gora irabazi zuela agertu zuen —fiskoari ezkutatzen zaizkionak kontatu gabe—. Hauetarik 514-k gainera hilean bost miloitatik gorako errenta hartu zuela agertu zuen. Honela bada, Frantziako errenta eskalak, estadistika ofizialetan datorren moduan, 1-tik 900-ra saltatzen du (salto ederra!), zeren miloi eta erdi zaharren 6.000 frankotatik familia pribilejiatuen hileroko bost miloitara baitoa.

Beste estadistika fiskal batzuk errenten desberdintasuna gizarte-taldeka agertzen dute. 1957-n buruko eta hileko bataz besteko errenta hilean 25.000 zen nekazaritzan, 26.500 alokatu tipi eta erdikoentzat, 55.000 merkatari ugazabentzat, profe-

sio liberalentzat eta goi-koadro zuzentzaileentzat (informe iturri: Haziendako ministerioa). Bataz-beste hauek garbi adierazten dute klase sozialen esistentzia.

Zifra hauek, ordea, ez dadukate interes haundirik, diferentziak izugarriak izan baitaitezke maila sozio-profesionalaren beraren barrenean. Honela alokatuen talde ugarian 1960-ko udazkenean hileko errenta zuzenaren gora behera zen 36.000 franko langileentzat eta 227.000 goi-koadro zuzentzaileentzat. Eta nola halaber kategoria beraren barreneko bataz-besteak diren —langile maila guztiak batetik eta koadro zuzentzaile guztiak bestetik— lehenengotik azkenerainoko distantzia izatez askoz haundiago da. Alokairurik apalenak sarritan hilean 23.000 frankoren bueltan dabiltza (probintzietako S.M.I.G.) Parisen ordea, gorengo alokairuak ia hiru eta lau miloitaraino heltzen dira. Beraz alokatuen taldean bertan ere benetako eskala 1-tik 150-raino doa.

Beste zifra ofizial batzuk ikuspen errealistagorik ematen dute: azkenengo estadistiken arauera (1958) 65 % langilek eta enplegatuk hilean 54.000-tik behera irabazten zuten, koadro zuzentzaileetarik erdiek 108.000-tik gora irabazten zutelarik. Talde sozialen barreneko diferentzia hauek erakusten dute zer kontuz erabili behar diren "alokatuak" bezalako esakera hain zabalak, gaurkoz behintzat elkarrengandik hain lekutako maila sozialak biltzen dituztenak.

*Gehiago edo gutiago aurreztuz, familiek ez dituzte beren errentak berdin enplegatzen*

Hauxe da puntu honi buruz azaldu nahi dugun azken idea. Egotez barietate haundia dago familiako errenten enpleguan, beren zenbatasunaren desberdintasunari dagokion barietatea gehienean. Gauza zaharra da frantzesari bistec-a patata frijituekin gustatzen zaiola alemanari choucrout-a, italiarrari pastak, holandarrai esnekiak, etab. Baina errenten enpleguko diferentziak dietetako diferentziez beste zerbait askoz diferenteagotan oinarritzen dira.

Egotez kontsumora doan errenta zatia, errentaren kopuruaren mende dago batez ere. Errenta laburreko familiak presuposturik gehiena janaritara destinatzen du. Errenta luzeagoko familiei ordea, jan gastuek errenta zati tipi bat bakarrik daramaietelarik, soberakin ederra geratzen zaie beste gauza batzutarako, hala nola kotxe, transporte, ikaskintza etab. Egia hau legetzat eman zuen Engel estadistikoak, zeinek frogatu baitu janaritarako partea gutitu egiten dela errenta gehitu ahala.

I.O.E.-k, Frantziako alokatu sail bakoitzerako presupostu-ereduak ateratzeko inkesten bidez, janaria peoi baten presupostutik (hilean 26.000 franko orduen) 40 % zela deskubritu zuen, koadro zuzentzaileen errentatik ordea, (hilean 111.000 franko orduan) 26 % bakarrik. Koadro zuzentzaileetan errenta osotik portzentaia hau tipiago izan arren, janari gastutan bestea baino hiru bider ge-

hiago zen: 28.900 franko koadro zuzentzaileentzat eta 10.400 peoientzat. Zertan gastatzen duen koadro zuzentzaileak janaritarako ez dena? I.O.E.-ko inkestak dio koadro zuzentzaileek 17 % jantzitan gastatzen zutela, peoiek ordea, 12 % bakarrik eta etxeko gastuak, transporteak (kotxe, scooter) edo ikaskintza (dibersioak sarturik) 42 % zirela (46.000 franko) koadro zuzentzaileentzat eta 30 % (8.600) peoientzat.

Inkesta partzial hau indarturik geratu zen Institut National de la Stadistique-k eginiko inkesta nagusiaz: 20.000 familia hartzen zituen eta erresultatuak 1960-ko azkenerantz argitaratu ziren.

Inkesta honek diosku janari gastuak aldatuz doazela buruko eta urteko 120.000 frankotatik (inkesta denboran) lurreko alokatuarentzat, 216.000 frankotaraino erdiko koadro zuzentzailearentzat; beraz 80 %-ko aldea guti gora behera. Baina erdiko eta goiko koadro zuzentzaileek errenta askoz mardulagoa edukirik (hiru edo laur bider haundiago), beren dibersio, opor, transporte eta ikaskintzari zazpitik hamabira bider gehiago eman ziezakeeten gizarte-eskalako oinean dagoen lurreko alokatuak baino, eta lautik zazpira bider gehiago erdiko langileak baino.

Familiako errentaren erabilkerako lehen desberdintasun honi ohitura sozialei dagozkien beste batzu erantsi behar zaizkio. Hain honela da hau non errenta berdinez langile xit espezializatuak ez baitu injineru hasberriak bezala konsumitzen, honek ikaskintzarako askoz gehiago gordetzen baitu, ez eta lur-kapatazak bezala ere.

Naziotik naziora diferentzia hauk nabarbenago dira alde batetik errenten diferentziagatik eta bestetik nazioko ohiturengatik: Frantzian esatarako, metalurjikoak bere errentatik 47 % inguru dedikatzen du janaritara; Holandako metalurjikoak ordea, 38 % bakarrik. Baina alderantziz, Frantzian bizitzera dedikatua 16 % da batez beste, Holanda ordea, 23 %-raino heltzen da.

Bukatu aurretik, gainera dezagun konsumoa ez dela derrigor berehalakoa. Alde batetik egunero erosten baditugu berehala edo berehalatsu konsumitzeko ondasunak (esaterako janariak, ikatza, medikamenduak, jantziak), bestetik konsumo deritzagu: etxeko gastuak, scooter, kotxe etab. Ondasun hauen ordezkuntzak amortizazio problema bat dakar.

Hona adibide bat: 120.000 frankotan erositako scooter hau hiru urte barren 30.000 frankotan bir-salduko dut okasiora. Mementu hartan scooter berri bat erosteko (eta honela neure edukia errekuperatzeko) eros-prezioaren eta scooterra saltzean hartuko dudanaren arteko diferentzia desboltsatu beharra egonen da, 90.000 franko, alegia. Beraz hiru urte barren ene scooterra gakorik gabe berritzekotan, gaurtik ordura 90.000 franko aurreztu behar, urtean 30.000 franko, alegia. Urteroko 30.000 franko hauk amortizazio bat dira, hau da, pizkanaka konsumituriko ondasun iraunkorrak berritu ahal izateko suma bat.

Gure egunotan amortizazioa epeka erosiz egiten da sarritan. Delako gaia ordezteko kantitatea hile batzutan aurrezten ekin beharrean, gai hau

lehenengotatik edukitzen da, kredituz erosirik edo zatika ordainduz. Honela ondasun iraunkor bat ordaintzea bukatutakoan, ia oso erabilirik dago. Nahi eta ez zorren bat egin behar ondasun iraunkor hura ordezteko ala bestela epeka erosi behar.

## III. ALOKATUEK AHAL DITUZTE ETA BEHAR DITUZTE BEREN ERRENTAK GEHITU

Aurreko gogoetek ebidentzia mordo bat agiriratzen dute. Lehenengoa da errentak izakeraz eta kopuruz talde sozial batetik bestera aldatuz gainera, talde barrenean bertan ere alde haundia dagoela, alokatuen artean esaterako. Esperientziak erakusten dauku errenten kopurua hainbat azkarrago eboluzionatzen dela zenbat eta gehitze-burruka indartsuago eta kolektiboago izan. Baita erakusten du historiak errenta zuzenetarako egia den afirmazio hau diferituetarako ere ba dela.

Honegatik azter dezagun orain zer bide dadukaten alokatuek —hemen gehien axola zaikun gizarte-maila— beren errenta zuzenak eta diferituak gehitzeko. Gero aztertuko ditugu beren eroskien prezioak gutitzeko daduzkaten bideak.

### *A. Zeren pentzudan dago alokairuen gehitzea?*

Hala Frantzian nola atzerrian eginiko estudio batzu adierazten dute alokairuen gehitzea, sindikatoen burrukari bakarrik zor ez bazaio ere, ge-

hien behintzat horrixe zor zaiola. André Triano--ren "L'action syndicale ouvrière" liburuak aparteko argitasuna dakar honi buruz. Sindikalismorik ekinkorreneko profesioak direla erakusten du alokairurik haundiendunak. Gainera profesio hauetantxe igoten dira azkarren alokairuak. Esaterako arte grafikoetako adarrean —sindikalismo xit ekinkorreko industria izaki—, bataz besteko alokairua oinetakogintzakoa baino 90 % haundiago da —hau sindikalismo xit moteleko industria izaki—.

Baina sindikatoen burruka hau halako kondizioetako giro batean burutzen da, era batera errenten kopurua determinatzen duten kondizioak noski. Esaterako, enpresa haundietan sindikalismoa hobeto antolaturik dago eta produktibitatea haundiago da. Honi eskerrak enpresa batek firma kazkar batean baino aloairu haundiagorik ordain dezake bere finantza ekilibriorik kolokatu gabe. Institut National de la Stadistique-k eginiko inkesta ofizialek ere erakusten dute nola kualifikazio berdinez alokairuak 28 % aldatzen diren bataz beste langileentzat (37 % enplegatuentzat), 1.000 alokatutik gorako ala 20-tik beherako enpresak izan.

Kualifikazio batzu ugazaben aldetik bilatuago izateak ere ba du zerikusirik. Profesiodunei esaterako, gauden zibilizazio teknikoan peoiak baino eskatuagoak izanik, bistan dago alokairuak azkarrago igonen zaizkiela. Berdin esan daiteke alokatu gizonezkoez ere, gehienean kaulifikazio altuago eta sindikato-burruka zorrotzago baitadukate. Arrazoi beragatik lurralde aberatsetan ere

gain behera doazenetan baino alokairu hoberik kobratzen da. Esaterako kalkulatu izan da nola lan berdinez 25 %-tik 30-rako aldea egon daitekeen alokairuan Parisen ala urrutiko probintzia batean lan egin, eta nola 10 %-ko aldea normala zen (kualifikazio berdinez) gizonezkoari ala emakumezkoari ordainduriko alokairua izan.

Beste diferentzia mota bat: Gorantz doazen industriek beherantz doazenak baino aste-alokairu haundiagoak ordaintzen dituzte, zati bat ordu-alokairu altuagoak ordaintzen dituztelako (beren ugaritasunak uzten die) eta beste zati bat beren alokatuei astean ordu gehiago eragiten dietelako klienteak sasoiz zerbitu ahal izateko.

Faktore desberdinok elkarrekin nahasten direnez gero, aisa ulertzen da bataz besteko alokairuak sarritan alokatuen talde berrenean bertan ere 1-tik 4-ra aldatu ahal izatea. Koadro zuzentzaileen alokairuak langileenekin konparatu nahi izatekotan, aurreko tasak 10-z edo 20-z bidertzea besterik ez dago.

### *B. Zeren pentzudan dago prestamen sozialen eta familiarren gehitzea?*

Beharrezko zaiku errenta diferituen eboluzioaz ere arduratzea, zeren, hasieran ikusi dugunez, oso inportantzia haundia baitaduka langile familientzat. Prestamen sozialen eta familiarren gehitzea ere, alokairuena bezala, langileek daramaten burrukaren bizitasunaren pentzudan dago.

Historia pizka batek argituko du. Askakunde mementuan prestamen familiarrak langile guztiengana zabaltzen ziren eta ekintza hau langileriaren garaitia haunditzat jo zen. Baina pizkanaka inflazioa eta prezioen igotea ekarri zuten eta honela klase pribilejiatuek berriro berenganatu zuten Askakundeko euforian langileen eskuetan utzi behar izan zutena.

Gaur alokatuek gerra aurrean hartzen zuten antzeko zatia hartzen dute nazioko errentatik, baina kontuan eduki behar da gaur numeroz alokatuen proportzioa askoz haundiago dela. Zer esan nahi du honek? Ugazaban klaseak, elkarren atzeko gobernuek eutsirik, lortu duela azkenerako langileek irabazitzat zeduzkaten segurantza soziala eta prestamen familiarrak irabazien kaltez ordain araztea.

Gerra aurreari buruz dudarik ere ez aurrerakuntza bat dela osasun oneko alokatuek gaixoei laguntzea. Baina batera nahiz bestera, jakin beharra dago laguntzaren oinarria mutualista hutsa dela: dena da alokatuek beren errentaren kopuru globala elkarren artean banatuko balute bezala gerra aurrean ez beste era batez, baina nazioko errentatik zati gehigarririk harrapatzerik lortu gabe.

Bestalde, oraintsutik hona Gobernuak eta ugazaba alderdiek oldarraldi berri bat jo dute langileen errenta diferitua mozteko, urteotan ezagutu dugun oldarraldirik azerikiena. Ez da besterik prestamen familiarrak alokairuen ritmo berean ez

gehitzea baizik, eta sarritan prezioen ritmoan ere ez. Honela prestamen familiarrak pizkanaka beren benetako balio (lortzeko ahalmena) galduz doaz. Eta nola prestamen hauxek diren langile familiarik gehienen errenta osoko hirugarrenetik bostgarrenerako partea, langileek hipokritaki moztuturik dakusate beren lortzeko ahalmenaren zati eder bat. Esaterako, jakitekoa da lau urtetan prestamen familiarrak prezioak baino 20 % gutiago gehitu direla. Errenta diferituen zatiari dagokion proportzio hau errenta familiar osoaren piloarekin konparatzen bada, 1956-tik 1960-ra bitartean langile familien lortzeko ahalmena 4 %-tik 7-ra gutitu dela atera behar (gutitze hau ez da beti alokairuen gehitzeaz partu izan).

Laburpenez bada, argi dago errenta zuzenen (alokairuen) eta diferituen (prestamen familiarren eta segurantza sozialeko errenboltsoen) gehitzea langileek eraman beharreko burruka sindikal eta politiko bikoitz baten mende dagoela. Gure ustez burruka honek jo behar du hala alokairu tasak gehitzera eta, lanorduak gutitzekotan, ordu gutitzea kitatzeko alokairu tasa hauen gehitzea lortzera, nola hile-alokairuak enplegu osoaren bidez erregulartzera edo bestela ordu gutitzeen kontrako garantia osoa edukitzera (alokairu minimo garantituen kontua).

Hala ere, ez dago asko pentsatu beharrik sindikatoen eta ezker alderdien ihardukiera honek urrutirago begiratu behar duela ikusteko: estruktura industrialen eta lurraldezkoen berrikuntzara noski, epe luzera alokairu mardulagoen ordain-

keta faboratuko duena, berrikuntza horrexek posibletuko duen produkzio nazionalaren gehitzeari eskerrak hain zuzen. Bego ordea, garbi langileak babestu egin behar direla delako estruktura-berrikuntzako ezbeharretatik, esaterako, Altzeiru eta Ikatz Elkarteak elaboraturiko teknikak jeneraldurik, aloatuek lan egiten zuten enpresako eraberritze aldian, lehengo alokairuak eta era batera bir-egokimendu profesionalerako modua eduki dezaten.

Azkenez organizazio sindikalek eta politikoek segurantza sozialaren aldetik sanitate gastuen errenboltso osoa baita prestamen sozialen bir-baliotzea ere lortzera jo behar dute. Prestamenok erdiko alokairuaren oinarriz atontzea komeni litzateke, geroan prestamen hauen eta alokairuen arteko desfaserik egon ez dadin.

Ekintza hauk kementsuki eta zentzuz eramaten badira, daitekeena delakoan gaude alokatuen errentak era progresiboki erregularrez igotea. Honek ez du esan nahi burruka honekin bakarrik nahikoa denik, estrukturen berritzera ere jo gabe. Honek bakarrik esan nahi du burruka hau faltatzekotan edo gorago aipaturiko helburu zabaletara jotzeko burruka ez izatekotan, mementuko edo tokiko garaitiak arrisku haunditan leudekela beren geroko jarraitasunean edo langileen kalterako lan-sistimetara leramaketela.

## IV. EROSKIEN PREZIOAK GUTITZEKO ERE BURRUKATU BEHAR DUTE LANGILEEK

Ez da nahikoa familietako errentez bakarrik arduratzea, zeren alokatuen bizimaila sozial guztiena bezala, hala baitago bizigosturen nola errenta familiarren mende.

Zeintzu dira kontra burrukatzeko moduko bizigostuaren faktore garestitzaileak?

Lehenengo eta behin gai batzuren urritasuna. Ez-urteetan esperientziak diosku jatekoen prezioek gorantz egiten dutela eta bai-urteetan pizka bat beherantz, merkatuko legeei ihes egiten dieten gai batzu izan ezik, jakina, hala nola haragia, gobernuen anitz propaganda kanpaina eta guzti ere, espekulazio lotsagarrien gai dena.

Egoera honek adieratzen dauku nola gai batzuren prezioak altzatzea lortzen den apropos urri arazirik. Gerra bien artean esaterako, siderurjiak cartel bat egin eta prezioei eutsi zien konsumoaren hondamendi eta guzti ere. Gaurko adibideak ditugu petrolioen cartel mundiala, inmobiliario jabeena, gerra bien artean bizitzetxe herritarrik ez egitean, alokatuentzako bizitzetxeen alkilerra oso goi mantentzea lortu zuena —alkilerren prezioa arautzen duen legeak uzten duen neurrian behintzat—. Behar bearrezko da beraz, —eta aurrenengo ekintza dugu hau— gai batzuren urritasuna (cartelen edo ugazaba-soken bidez) apropos lortu eda mantendu ahal izaterik eragoztea.

Beharrezko da baita zergek, gaur egiten duten

bezala, prezioak hainbeste ez garestitzeko kontu hartzea ere. Tabakoaren prezioa 70 % zergena da, fosforoena 45 %, gasolinarena 73 %, kotxe, motor eta elektrodomestikoena 25 %. Zergatan 10 % bakarrik ordaintzen duten enerja gaiak (gaz, ikatz, elektrika) eta 6 % bakarrik dadukaten jatekoak (esne, ogi eta honelako batzu berriz zeharo esoneraturik daude) izan ezik, Frantziako gai ia guztiek 20 % guti gora behera ordaintzen dute zergatan. Zergatik honen tasa altua? Bada, belaun-aldi batzutatik honantz Parlamentua errenta altuak asko grabatzearen kontra dagoelako eta konsumitzaile tipiengandiko zergak hartzea nahiago duelako. Gaur Estatuko sarreretatik hiru laurden konsumo-zergenak dira. Segur asko zerga hauk ez lirateke hain astunak Estatuko gastu alferrekoak gutituko balira edo, gastu konstantez, errentaren eta aberastasunaren gaineko zergei dagokien zatia haundiago balitz. Hemendik bitariko ekintzaren beharra.

Bistan dago Frantziako banaketa-zirkuitoen gostu bereziki altuak ere garestitzen dituela prezioak. Janari sailean, opor aldietan batez ere, hain adibide ugariak daude non ez baitago gehiago ekin beharrik. Denok dakigu tomateen kasua, baserritarrei kiloa 10 frankotan erosi eta hiri nagusietako konsumitzaileei 50 eta 100 frankotan, eta inoiz garestiago ere bai, saltzen zaiena.

Hamarkada batzutatik honantz publizitate gastuak gora eta gora datoz eta erosten ditugun gauzen prezioak anormalki grabatzen dituzte. Kasu batzutan gastu hauk gaien salmentako prezioaren

herena edo erdia dira. Kalkulaturik dago Estatu Batuek Frantziako Estatuaren presupostutik hiru laurdeneraino gastatzen dutela urtero publizitatean (¡errenta mugatuko miloi bat bizitzetxeren prezioa!).

Zer egin guzti honen kontra? Hemen urreko eta urrutiko etorkizuna berezi beharra dago. Gaur Frantzian eta Merkatu Batuan ari diren ugaza--soken kontrako burrukak eragotz dezake prezio batzuren igoera. Halaber zergen kopuru globala gutitzearen alde jokatuz edo, hobeto dena, konsumo-zergen karga zati bat errenta-zergetara pasatuz lor daiteke prezioen gutitzea.

Azkenez Estatuko gastu alferrekoak —gastu militarrak batez ere— gutitzeak eta gastu jeneralak —sarritan lotsagarriak— mozteak prezioen gutitzea lekarke banaketa-gostuaren beherakadaz batera.

Baina berehalako burruka hauek lehen bezala uzten dituzte gaurko estrukturak. Luzarora fikazago gerta daiteke prezioei ekitea, ekintza honek hiru zer hauk harrapatzekotan:

— produkzio nazionala, hobeto planifikaturik eta irabazi pribatuaren interesetatik askaturik, goragoko mailara eramana eta nazioko premiekin adosago dagoen bidetik zuzendua izan litekeena.

— banaketa, kooperatiben edo konkurrentziazko komertzio publikoen esku utzirik, bere gostuak jatsiko lituzkeena.

— gure estrukturen etengabeko egokiera au-

rrerapenera eta premietara, aktibitate iraganko-rreko industrien eraberritze sistimatikoz eta alokatuen etengabeko bir-egokimenduz enplegu berrietara.

## V. KONKLUSIOAK

Gure ustez prezioen arloko burruka errenta zuzenen edo diferituen gehitze burruka bezain inportantea da herriaren ongizaterako. Ekintza bikoitz hau bizimaila kontua baino askoz zabalago da. Eta hau modu bat baino gehiagotan.

Lehenengo, buruzagi sindikalei eta politikoei —berehalako helburuen alde burrukatzera ohituei— konpreni arazten dielako orainen lorturiko garaitiek ez dadukatela geroan garantiarik estrukturen sakonez izan ezik.

Bigarren, sindikatoen eta familien ekintzan sarturiko anitz hiritar borondate oneko ohitzen duelako erreibindikatzaileei sarriego ordaintzat ematen zaizkien hitzez desfidatzera. Honela ekintzaile argiak eta esperimentatuak prestatzen ditu ekintza bereziki politikorako eta geroko estrukturen eramantzarako.

Azkenez bizimailaren aldeko burruka honek pizkanaka herritartuz daramatza Frantzian tradizioz pentsalari sozialisten arlo izaniko idealak: nazioko errentaren banatze berdinkorraren ideala (oraingo errenten desberdintasun gehieginabarbenduz); familien benetako premiak aurrenen

asetzea lortzeko ideala (ekonomiaren helburu eta motortzat irabazia imini beharrean); azkenez ahalik eta efikazia ekonomiko eta sozialik haundienaren ideala, gaur gabineteko pentsalarien edo ekonomisten kontua bakarrik ez dena, baizik eta malthusianismoaren, produkzioko anarkiaren eta abusozko marjenen gostu gehiegiaren kontra dauden teknokrata pribatu eta publiko guztiena ere.

Jomuga hauetarantz eramatean, prezioen beheratze eta alokatuen errenten behitze burrukak hiritarren buruak sozialista —edo ez-kapitalista eta ekintzaile mordo bat prestatzen duelarik geroko estrukturen elaboraziorako. Hau egitean, lehenengotako erreibindikazio-burruka arras gaindurik geratzen da, kontzientzia hartze eta konpromiso politiko batera heltzeko. Hauxek dira errealitate ekonomikoaren inguruko gogoetak ekar ditzakeen ondoriorik desiragarrienak.

# III - GARREN KAPITULUA

## NOLA FUNTZIONATZEN DU ENPRESAK ETA NORK ERAGITEN DIO?

Problema ekonomikoen hatsapeneko hirugarren kapitulu honetan mekanismoen estudioari ekinen diogu. Zentzuzko da gainera honela izatea, aurreko kapituluetan aztertu baitugu nola denok parte hartzen dugun aktibitate ekonomikoan eta hortik datorren bizimaila xit diferentea hiritar batzurentzat eta bestetzurentzat. Zergatik batera parte harturik ondorio hain desberdinak?

Hauxe da ekin diegun problema haundietarik bat, baina ez bakarra. Era berean enpresen funtzionamendua arautzen duten mekanismoak ez dira gure errentetako diferentzia haundien errudun bakarrak. Honegatik baita ere aztertu beharko dugu nola eragiten dioten errentaren banaketari nazioko estruktura ekonomikoek eta nazioa-

ren izenean klase agintariek harturiko erabaki ekonomikoek. Hemendik datorke, bistan dagoenez, jarraikitako joera politikoaz eta bere erabakien egokitasunaz galde egitea.

Oraingoz konforma gaitezen nola eta noren onerako funtzionatzen duten enpresek galdatzeaz.

Zergatik oratzen diogun mekanismo ekonomikoen azterketari enpresaren ikusmiratik? Enpresak direlako denok parte hartzen dugun eginkizun ekonomiko haundiko oinarri-zelulak, "mikrozelulak" espezialisten esakeran. Ez uste, ordea, mikrozelulak deitu arren enpresa guztiak tipiak direnik. Renault (60.000 langile), Krupp (100.000 langile), edo Usinor, Lorraine-Escaut, Saint-Gobain, Citroen, Péchiney mikrounitate oso zabalak dira. Baina unitate haundi hauekin batera beste batzu daude askoz tipiagoak: herriko errementaria, maisu iheltseroa, eskultorea, etab. Nekazaritzan ere desberdintasun haundia dago: Beauce-ko esplotazio mekanizatu haundiaren ondoan bretainiar edo Cevennes-tar nekazari tipia dago, bere mendisketan jaio, bizi eta hiltzea espero duena. Komertzio arloan ere berbera gertatzen da: Lafayette Galerien, Prisunic kateen edo konsumo kooperatiba izugarri haundi hoien ondoan, denok ezagutzen dugu bazterreko dendari apala, zapatari tipia, etab. Baina orain axola zaikunerako, edozein produkzio-unitatek, haundi nahiz tipi, alderdi kideak daduzka laster aztertuko dugun bezala.

*Lehenago baino garrantzia gutiagoko papera baina oraindik funtsezkoa*

Enpresak paper nagusi bat jokatzen du ekonomian. Gizonak eta makinak batzen ditu produzitzeko eta sarritan konsumitzeko ere bai (lehengaiak, enerjia, transporteak etab.). Berak egiten ditu inbersioak, beste enpresa batzutakoekin batera nazioko ekipo-gastuen partidarik haundiena osatzen dutenak. Enpresa da inportatzen eta esportatzen duena. Deitura mailan ere enpresaren paperak garrantzia haundia daduka, zeren enpresak sozialdurik dauden nazioetan "sozialista" deitzen baitzaizkie —sarritan behar ez bezala akaso—, enpresarik gehienen jabego pribatuak dirauen nazioetan, ordez "kapitalista".

Mende honen hasierara arte —manualetan Ekonomia Klasiko deritzan haroa— enpresaren papera orain baino askoz inportanteago zen. Zergatik? Bada, orduan uste nagusia zelako enpresen funtzionamendu libreak ahal zuela —areago, behar zuela— nazioa ugaritasunik haundienera eraman. Hain adarretan dirua irabaz zitekeela ikusiz batera —eta hau arinegi lotzen zen ase beharreko premia baten esistentziaz— enpresak eta enpresak sortzen ziren irabazi potentzial hura harrapatzeko. Nola asko sortzen ziren, konpetentzia zegoen beren artean eta produktoak, gaiak edo zerbitzuak preziorik gutienean eskaintzen zitzaizkien konsumitzailee. Eskaintza-eskarien legearen indarrez enpresak hil-biziko papera jokatzen zuen nazioetako ekonomien hazte eta burutzean. Beraz

Estatuak ez zuela hauzi hauetan sartu behar ateratzen zen, ezepzio bakanetan izan ezik.

Filosofia ekonomiko hau, jakina, ez da guztiz desagertu. Hauteskunde kanpainetan, hautatzaileei zabalduriko edo hormetan itsatsitako anitz paskinetan "enpresa librearen" defentsa aurkitzen dugu oraindik sarritan. Zehazki mintzatzekotan, hobe litzateke "enpresa pribatu" deitzea, zeren Pinay jaunaren lagunek gaitzesten dutena ez baita hainbeste Estatuaren esku-sartzea ekonomian, enpresen konfiskazio edo kontrola kolektibitate publikoaren aldetik baino. Hala ere "enpresa libre" deiturari filosofia kapitalista eta konserbatzaile hauxe adierazteko eutsi izan zaio, zeren, lehenengotan, haren joera botere publikoaren esku-sartzea ekonomian moztera baitzihoan batez ere.

Ekonomista klasikoek onartzen zuten noski Estatuak ekonomian eskua sartzea, baina xit laburki izatekotan. Enpresen ardurapean ez zeuden zerbitzu kolektibo batzu seguratzea zegokien! polizia, tribunalak, karretaragintza eta hauen zaintza, harmada etab. Batez ere eskaintza-eskarien lege oinarrizkoa errespeta arazteko obligazioa zedukan, inork espekulatzerik eragotziz. Zaindu beharra zedukan merkatariek elkarren artean zikin joka ez zezaten —esaterako, faktura gabe ezer ez saltzeko kontu hartuz—, industrialek sarrera librea eduki zezaten lehengaien eta lanaren merkatura, etab. Laburki: konpetentzia hutsa eta hotza zen —berez— hura (paroa ez zen gaitz bat, sistimaren ondorio lojiko bat baizik!), Estatuak errespeta arazi beharreko konpetentzia.

Gaur eguneko ekonomian bañar-enpresaren paperak garrantzia galdu du. Lehenengo, interbentzio publikoak aniztu direlako: gizarte-legeak, fisko-legeak, kreditoaren arauketa, planaren prestatze eta betetzeari buruzko araudiak, etab. Bigarren, gero eta maizago bakar-enpresa iniziatibez gainera —irakur "ordez"— talde indartsu eta organizatuak datozelako: produkzioko oligopolioak (ugazaba-sokak), alokatuen oligopolioak (sindikatoak), konsumoko oligopolioak (komertzio-katea nagusiak) etab. Hirugarren, Estatua bera ere gero eta iniziatiba gehiagoko ajente ekonomiko bilakatu delako, batzuri eskabide izugarriak eginez, bestetzuri subentzioak edo dirutza haundiak prestatuz. Azkenez, behinola enpresa pribatuen ardurapean zegoen hainbat eta hainbat premia beste esku batzutara, zati bat behintzat, pasatu delako: esaterako, konstrukzioa, lehen elkarte inmobiliario pribatuen eskuan osorik zegoena; baina bizitzetxe herritarrei buruz batez ere hain jokabide gaiztoa eraman zuen non Estatua huts hura betetzeko zerbitzu publiko bat sortzera beharturik aurkitu baitzen: H.M.L. adarra ("errenta mugatuko bizitzetxeak"), gaur egun Frantziako konstrukzio osotik herena daramana. Era berean, nazio zati batek ganoraz bizitzeko modurik ez zedukanean, Estatuak asistentzia sozialeko organismoak hor-hemendu zituen, bizitza ekonomikuko sail oso abandonatu batzuren ardura harturik (zaharren laguntza, gaixoak, gerra alargunak, edonolako gaitzdunak, etab.). Osasun-zerbitzuetako zati haundi bat ere Estatuaren eginkizuna da gaur: midiku-laguntza, hospitale haundien jerentzia, se-

(tresna elektrodomestikoen fabrikek aspirailuak egiten dituzte; konstrukzio, bizitzetxe eta abarreko enpresak). Etxeek, aspirailuek bezala, ez dute beren aldetik beste ondasunik produzituko, beraz konsumo-gaiak dira, baina apurka apurka konsumituak direnez gero, konsumo iraunkorreko ondasunak deitzen zaizkie.

Ba dira beste enpresa batzu ere ekipo-ondasunak, beste gai batzu egitekoak, produzitzen dituztenak, makinak esaterako. Apurka apurka, jakina, hauk ere gastatu eginen dira eta finantza koskarik gabe ordeztu ahal izateko (balio ez dutenean) beharrezko dateke amortizazioa eginik edukitzea (hau da, beren ordeztearen prezioa hainako dirutza bat apartatzea). Baina erabiltzea utzi orduko anitz gai produziturik dukeite ia.

Konsumo-ondasunen eta ekipo-ondasunen arteko muga bereztea oso zaila da. Haurtxo-baratzeek, ama-eskolek, higiene-etxeek, hospitaleek, nahiz eta berehala inolako gairik ez produzitu, osasuna fabrikatzen dute. Hauek eta beste antzeko anitz "zerbitzuk" indar ugaltzailearen produktore izatea dadukate elkarrekin.

### *Lehen, bigarren, hirugarren sektoreak*

Klasifikazio hau gero eta zabaltzenago doa. Enpresak klasifikatzea da berezko baliakizunen balorazio prozesoan dadukaten tokiaren arauera.

Lehen sektorean ateratze lanak daude (ikatz, mineralak, petrolio) eta lurrarekin zerikusi oso zuzena duten produkzio-lanak: nekazaritza, arrantza, baso-zaintza. Bigarren sektoren transforma-

zioko industriak daude. Eta azkenez hirugarrenak beste sektoreetan sartzen ez direnak hartzen ditu: "zerbitzuak", komertzio, transporteak, irakaskintza, ikuskizunak, etab. Gaur asko hitzegiten da hirugarrenaren desarroiloaz eta hala agiri da komertzioen, "zerbitzuen", profesio liberalen, funtzionario publikoen eta pribatuen, eta abarren ugaltzean. Ugaltze hau, geroago ikusiko dugunez, ekonomia aurreratuetako alderdietarik bat da.

*Nork hautatzen du zer produkzio egin?*

Klasifikazio hauk produkzio-ereduaren arauera azalduz gero, beste problema hau datorkigu orain, hain enpresak fabrikatuko duena nork hautatzen duen jakin. Nazio kapitalistetan, eta beraz Frantzian ere bai, erabaki hau kapitalaren ordezkariak hartzen du. Nor den hau? Enpresetako era juridikoaren mende dago hau. Bakar enpresa batean kapitalista enpresaduna bera da, ugazaba edo artisano, bertan lan egiten duten alokatuak guti badira. Artisanok nahiz ugazabak gauza bera esan nahi du. Alde bakarra, fiskalki, zer negozio zifra lortzen duten.

Gure egunotan enpresarik garrantzitsuenek elkarte era hartzen dute. Hauetan kapitalaren ordezkaria bere jabeek hautaturiko administrazio-kontseilua da. Jabeoi akzionistak deritzate, "akzioak" izeneko enpresen kapital zatiak daduzkatelako. Administrazio-kontseilua noiz behinka bakarrik batzen da eta bere eguneroko aginpidea zuzendari bati edo batzuri uzten die, berak hauta-

turik eta bere kontrolpean, kontseiluak ezarritako bidetik lan egitera behartuak.

Ba da beste elkarte era bat, kooperatiba. Hemen ere kapitalaren ordezkaria administrazio-kontseilua da, baina honek bere aldetik kooperatzaileak, elkarte modu honetako akzionistak, ordezkatzen ditu.

Zergatik den kapitalaren ordezkaria zer produzitu hautatzen duena? Bada, errejimen kapitalistan kapitalaren ordezkaria delako iniziatiba nagusiak hartzen dituena. Bera da baita enpresako kapitala guti den eta kapital gehigarririk bilatu behar den erabakitzen duena.

Enpresa bat fundakeran, kapitalak erabakitzen du zer zuzenbide emanen zaion. Gero ere berak gidatuko du enpresako bizitza, egunero hartuz haren esistentzia maneiatuko duten erabaki komertzial edo finantzariak (produkzio planak, inbersioen ritmoa eta nolakotasuna, prezio mailak, etab.). Beraz, ez zaio errejimen honi kapitalista izena arrazoi gabe ezarri: kapitalaren jabeak (edo bere ordezkariak) paperik behinena jokatzen du enpresen, aktibitate ekonomikuko oinarri-zelulen, destinoan.

### *Irabazi preikusia, hautaeraren kausa eta sistimaren eragile*

Kapitalaren ordezkariak (jabeak edo zuzendari delegatuak) zeri begira hautatzen du firmak eginen duen produkzioa? Kapitalista errejimenean produzitzekoaren hautaera produkzio honek ira-

baz araziko duen diruari begira egiten da batez ere, hau da, lortzeko irabaziari begira. Hauxe da ekonomistek beren sasi-hizkeran esaten duten "merkatuko eskeei erantzutea", "eskari efektiboaren asepena bilatzea". Hizkera argira itzulirik, hauxe esan nahi du honek: "dirua irabazi, erraz saltzeko zerbait produzituz". "Eskari"ri erantsitako "efektibo" izenlagunak esan nahi du ez direla haintzat hartzen beren asepena ordaindu ezineko premiak. Eskari hau, benetakoa baina gaudimengabea izanik, "ez-efektibotzat" jotzen da eta hor konpon. Geroago ikusiko dugu nola gaudimen gabeko eskari honetaz ez arduratzea den hain zuzen kapitalista errejimeneko akatsik aurrenetarikoa.

Honela bada, zer eginen du kapitalaren ordezkariak irabazi mardulak —epe laburrera edo gure aldion batez ere, epe luzera— emateko produkzioak non dauden topatzeko? Merkatuaren azterketa bat eginen du —edo espezialistei ordaindu egin dezaten—, produkzio irabazkorren berri emen dezana. Lehenago azterketa hauk enpirikoak ziren. Harategi bat irekitzen zen herrian behar haina harategi ez zegoela uste zelako, edo botoigintza hasten industria hau espansio bidean zegoela ikusten zelako, edo errementaria bat imintzen, errementaririk hurbilena herritik urrutiegi egonik, herrian bertan klienteak erraz aurki zitezkeelako, etab. Gaur enpresak gero eta inportanteago dira eta ez daitezke honela guti gora beheraka ibil. Beren hautaeretan ustekabe eta enpirismo apurrik geratu arren oraindik, dudarik ere ez behinola baino askoz zientziazago jokatzen dutela, merkatu-azterketa hedatsuak elaboratuz.

Merkatuak topatutakoan, kapitalaren ordezkariak —beti berak— nahi den produkziorako beharreko medio teknikoak bilatzen ditu: makinak, patenteak (beste batzuk asmaturiko prozedimenduak erabili ahal izateko), lehengaiak, langileak, etab. Lehenengo kapitalaren jabeak kapital gehigarririk behar den ere galdatuko du, gauza edo jende guzti hauk erosi, alkilatu edo ordaindu ahal izateko.

Industriazko enpresa baten abiatze-prozeso sinpletu honek berdin balio du industriaz beste adar ekonomiko batzutarako ere. Nekazariak, kapitalista industriadunak bezala, zer produzituko duen galdietzen du. Bere merkatu-azterketa egiten du Gobernuak, denboraldiaren hasieran, aurretik izendaturiko prezio indikatzaileei begiratuz, eta orientaziozko prezio hauxen arauera kalkulatzen du, haundi haundika, uzta on edo xar batek zer eman liezakeon. Erremolatxaren prezioa ez dela hain emankor uste badu, patatak edo emankortasun gehiagoko beste gai batzu ereitea hauta dezake. Bistan dago enpirismoak askoz gehiago erabakitzen duela adar honetan, baina gero eta gutiago nekazariak enpresako kontaduria gero eta ezagutuago doazen neurrian.

Komertzioan, jakina, merkatuaren aurretiko azterketak industria haundian baino inportantzia gutiagoko papera daduka, eta hala ere, komertzio nagusiak halako arreta jartzen dion non almazen haundi askok bere merkatu-azterketak zientifikoak egiten baititu etxeko-andreen kontseilu edo batzordeak aldizka inkestapetuz, hauen iritzia gauza hauetan oso kontuan hartzen baita.

Hona, bada, bere alderdirik funtsezkoenetara laburturik, nola martxan imintzen den industria, lur edo komertzio enpresa bat nazio kapitalista batean. Bere ekina ere modu berean zuzentzen da: abiakeran bezala helburua lorkeran ere, iniziatiba nagusia kapitalaren ordezkariari dagokio. Beharrezko denean berriro eginen di tu gorago aipaturiko operazioak: zer produzitu hautatu, hasierako produkzioak pentsaturiko merkatuen arauera aldatzeko posibilitatea eta arriskua ere kontuan edukirik, erabakitako fabrikaziorako behar haina makinaz, gizonez, lehengaiz eta patentez hornitu, kapital gehigarriak, premiarik bada, topatu, etab.

*Huts nabarben bat: Irabazi iturri ez dena baztertu*

Guzti honek lojiko eta arrazoizko dirudi. Pentsaketa laurden aski da ordea, sistima ekonomiko honen ondorioak ez direla ederrgiak ikusteko.

1. Inor ez da arduratzen benetako premiarik, gaudimendun ez bada, asetzen (ekonomistek liokeitenez, "bere eskaria efektiboa ez bada"). Esaterako, ehun urtetarik honantz pobreen bizitzetxea gaudimen gabeko premia da, zeren jende hauen errentek ez baitute permititzen bizitzetxe herritargintzak irabazi haundiak uzteko moduko kantitaterik bizitzetxera destinatzerik. Ez dago beraz, jende pobreentzat bizitzetxegintzara dedikatzeko enpresa pribaturik. Mende batetik honantz eta noiz behinka, firma batzu saiatu dira hain behar gorriak eskari "efektibo" bihurtzen

zuena asetzen, baina operazioa errentakortzen zuten alkilerrak klienteria haundirik harrapatzeko altuegiak zirela konturatuz batera, atzera egin zuten. Hortik orain bizitzetxe herritarren krisis izugarria, okerragotu egin dena gainera beste arrazoi batzurengatik, hala nola pilaketa urbanoa eta gerrak. Azkenez enpresen bizkar altzatze hau hain haundia izan da non botere publikoek beren ardurapean hartu behar izan baitute adar hau, "errenta mugatuko etxeen" finantzazioa jarririk.

Beste adibide bat: zaharren ongizatea. Arlo honetan egundoko premiak egonik ere, gure aldion merkatu hau ez da bat ere tentagarri. Enpresa kapitalistek ez dute, ez, elkar janen beren indarrak nazioaren onerako agortu dituzten zaharren premiez —bidezkoak dudarik gabe— osaturiko merkatua harrapatzen. Zergatik ez? Edadean gorako pertsonen baliakizunak gehienean urriegiak direlako haien premiak asekeran irabazi gizenik ateratzeko. Era berean, nazioko barrutitik irtenik, gizateriako bi herenen gosea ez dute enpresek premia efektibotzat hartzen, zeren afrikar-asiarren eta erdi eta hegoa-amerikar gosetien erosteko ahalmen koitadua kontuan hartuz gero, ez baitago —komertzio mailan— haiei jaten emanez irabazi dezenterik ateratzerik. Behar litzatekeen produkzioari beraz, ez zaio oratzen. Aitzitik ordea, era datorrenean, nahiago izanen da merkantzia ia produzituak desegin, ordaindu gabe konsumitzeko ohitura hartuko lukeiten jendeei erregalatu baino. Gaur egun diru gabeko konsumitzailearen estatutoak —nahiz eta gizateriako zatirik gehiena-

ren premiak asetzea izan— ez daduka tokirik mendebal aldeko kategoria ekonomikoetan.

Adibideak erruz ekar litezke. Jar dezagun azkenengo bat: nekazarien gogoa beren lurrak mekanizatzeko. Belaunez belaun gogo hau ez da eskari "efektibotzat" jo izan eta beraz haintzat hartu ere ez. Nekazariek, jakina, antzinako medioekin lan egiten eta beren eta nazioaren kalterako kondizio ekonomikoetan produzitzen seguitzen zuten. Baina nola traktoreak baserritarrik gehienek ordaindu ezineko prezioan saltzen ziren, traktoregintza barregarria zen. Laburpenez eta gehiago ekin gabe, gogoan eduki premia "efektiboa" hots, gaudimenduna ez bada, ez dela hura asetzeko tutik ere egiten.

2. Premia batek gaudimena galduz batera, lojika zorrotz berberak ekarriko du hura asetzeko produkzioa laburtzea. Har dezagun adibidetzat izozgailuen eta garbigailuen produkzioa 1958-ko azkenetatik 1960-ko hasierara bitartean. Produkzioa gutitu egiten da eskari "efektiboa" (hau da, gaudimenduna) gutitu delako familia herritarren bizimaila beheratzeaz, "finantzen sanokuntza" izenez Pinay-De Gaullek harturiko neurrien erruz. Familietan elektrodomestikoen premiak berdin seguitzen zuen, baina produkzioa jautsi egin zen eskari "efektiboaz" pareratu arte.

3. Azkenez, produzio baten emankortasuna (hau da, irabaziak emateko gaitasuna) gutitzean, produkzioa frenatu edo eten egiten da, nahiz eta bai egon eskari "efektiborik". Ba liteke eskaria behar bezain sendoa ez izatea edo salmentako

prezioei ezin eustea edo baita produkzioko gostua salmentako prezioa baino azkarrago gehitzea ere.

Hala industriadunak, nola nekazariak, nola merkatariak hain produkziori eutsirik beste gai batzu salduta baino diru gutiago irabazten duela somatzen duenean, lojikak agudo darama bere produkzioa gutitzera edo aldatzera. Esaterako bizikleten eskaria makaltzean, motorrenak (enpresa egileentzat errentagarriago, garestiago delako) zati bat kentzen diolako, bizikletagintza kolpera gutitzen da eta motorgintza gehitzen. Kotxe haundien produkzioa gutitu edo establetu egiten da, tipiena gehituz. Marka inportanteetako hariak eskatuago direnean (nahiz eta garestiago izan), beren produkzioa gehitu egiten da besteen kalterako. Nekazari batek, esplotazio anizkoitz batean, gariari lur gutiago eta larre artifizialei (ganadua hazteko) gehiago emanez gehiago irabaziko lukeela uste duenean haragiaren prezioak onuratsuago direlako, haren laboregintza establetu edo galdu egiten da haragiarena gehituz.

Dudarik gabe, tamalgarria ez da produkzioak merkatuko gora beherei segitzea. Ekonomista sobietarrek urte batzutatik honantz baztertu dute merkatuko ekonomiari behinola zioten arbuioa, eta anitz iritzi haztaketa eginez, eskari "efektiboa" eta familien eros-asmoak jakitea bilatzen dute. Ekonomia kapitalistetan tamalgarri dena da ez direla premiak, benetakoak izanik ere, haintzat hartzen gaudimendunak izan ezik eta bertan behera uzten direla lehen haina irabazi ateratzerik permititzen ez dutenean.

Hertsiki aplikaturik, sistima honek nazioko

premiarik funtsezkoenak baztertzera darama: irakaskintza, osasuna, gazteak, zaharrak. Bir-moldaturik —Frantzian mendearen hasieratik honantz bezala— sistima honek Estatua ardura araztera darama oraindik gaudimendun ez diren eskari benetakoak gaudimendun bihurtzeko eginkizunaz, edo bere kargu har araztera, zerbitzu publiko egokien bitartez, sektore pribatuak "ahazturik" daduzkan premien asepena. Kasu biotan sistima kapitalistaren "zuzenketa" honek Estatuaren konpetentzia ekonomikoa zabaltzera darama, baina zabaltze honek ez du esan nahi berez ontzat jotzekoa denik, zeren sarritan baitarama —adibideak ugari dira— irabazi posibleak sektore "libreari" uztera eta Estatua —hau da, zergapekoak— defizitez kargatzera. Frantziako ekonomia hamarkada batzutatik honantz "irabazidun baina arrisku gabeko kapitalismoaren" bide honetan dagoia.

## II. ZEINTZU MEDIO, PERTSONAZK ETA MATERIAL, ERABILTZEN DITU ENPRESAK?

Hasierako hautaera —zein produkziori ekin— enpresak egina dadukala emanik, orain beharrezko zaiku zeintzu medio erabiliko dituen galdatzea.

### A. *Lehenengo, kapitala behar du*

Kapitalak permititzen du gainetiko faktore beharrezko guztiak erostea, alkilatzea edo ordaintzea: makinak, patenteak, lehengaiak, alokatuak.

Alokatuak, jakina, ez dira lehengaiak balira bezala erosten. Gehienez ere beren gaitasuna, beren ahalmena eta beren lanaren denbora alkilatzen da eta honela, kasurako, edozein hornituraren antzekotzat jo daiteke.

Enpresa jaio araziko duen kapitala pertsona bakarrak edo batzuk iminia izan daiteke. Bakarrak iminia bada, bakar enpresa deritza, Frantzian zabalduen dagoen era. Komertzio eta industriako 1.750.000 enpresa frantsesetatik (Stadistiques et Etudes financieres, 1961-ko martxoa) 1.591.000 bakar enpresak dira, beraz hamar hamaikaren guti gora behera. Laster ikusiko dugu ordea, firma hauen garrantzia ekonomikoa beren numeroaren proportziotik urruti dagoela.

Kapitala pertsona batzuk iminia izan daiteke. Orduan elkartea (Frantzian) izan daiteke: kolektiboa (16.000), partzuergoa (2.000), erantzukizun mugatukoa (S.A.R.L., zeinetan sozio bakoitzaren finantza-erantzukizuna, enpresak porrot egitekotan, berak iminitako kapitalari bakarrik baitagokio. Gaur Frantzian honelako 12.000 daude) edo elkarte anonimoa (erarik modernoena eta enpresa haundiei ondoen datorkiena; hauetan ez da akzionisten izenik ezagutzen. Hortik "anonimo" deitura).

Enpresa hauek gaurko frantziar ekonomian zer inportantzia duten antz bat emateko, esanen dugu diren gutian ere (36.000, hau da, apenas % 2 Frantziako enpresa guztietatik) elkarte anonimoek egiten dutela nazioko negozio zifratik % 42 eta ordaintzen Frantziako alokairurik ia erdiak. Zifra

hauek ondo adierazten dute nazio honetako gaurko bizitza ekonomikoan dadukaten influentzia eta ematen industriako eta komertzioko konzentrazio haundiaren lehen antz bat.

Akziodun elkarteetako partaideek (partzuergo, S.A.R.L., elkarte anonimo) "akzioak" daduzkate enpresako kapital zati baten jabegoaren ezaugarritzat. Paperezko tituloak dira, sarritan Boltsan negoziatzekoak eta beren prezioa, aldakor eskariaren arauera, egunero kotizatzen dena. Elkarte kolektiboena bukatzeko, gaineratu behar dugu produkzioa hasteko edo hazteko kapitala nahikoa ez denean, elkarte hauek diru prestatua har dezaketela beste kapital jabe batzurengandik. Hauei obligaziozko prestatzaileak edo "obligazionistak" deitzen zaie (beren prestamenaren agiriari "obligazio" deritza), baina ez dira akzionista bihurtzen.

Sarritan enpresako kapitala imintzen dutenak bere funtzionamendu onaren ardurarik gehieneko pertsonak dira: langileak edo klienteak. Langileak era batera enpresako kapitalaren jabe badira, produkzioko kooperatiba bat egiten dute. Enpresako kapitaldunak klienteak badira, ordea, konsumoko kooperatiba bat egiten dute. Urte gutitan sakada itzela eman dion kooperatibaren berezgarrietarik bat da hasieran anitz soziotarik bakoitzak kapital tipi bat bakarrik imini behar duela sarritan. Kooperatiba izan da sozialistek bultzaturiko lehen formuletarik bat: bere abantaila datza modu honetako enpresa batez ez duela bere etorkizuna kapitalista baten, biren edo hiruren mende uzten, pertsona mordo haundi baten esku baizik, hauen interesak, langileak nahiz klienteak izan, enpre-

sarenekin oso bat direlarik. Nekazaritzan kooperatibismoak egundoko gorakada egin du Frantzian: ardogintza, gari almazenajea, esne industria eta oraintsuago lur-tresnen batera erabiltzea (C.U.M.A.). Azken hau nekazari batzuren elkartzea da, beren lurren esplotazio arrazionalerako behar haina lur-tresneria erosteko modurik bakarka eduki ez eta elkarrekin erostea pentsatzen dutenak.

*Sektore publikoaren garrantzia*

Enpresa kolektiboaren azkenengo era bat ere aipatu behar dugu: enpresa publikoa. Bertan botere publikoak dira jabeak zatiz edo osoz. Estatua bada produktore bakarra (tabako, fosforoak, ikatz minak, elektrika, etab.) monopolio bat da. Baina Estatuak ba daduka enpresa konpetitzailerik ere (Renault, petrolio elkarte publikoak, etab.). Enpresa publikoa nazioko administrazioaren edo eskualdeko administrazio baten mende egon daiteke, esaterako R.A.T.P. (Regie Autonome des Transports Parisiens). Gaur enpresa publiko diren asko behinola pribatuak izan ziren eta bere egunean botere publikoari transferituak (esaterako, Charbonnages de France, Electricité de France, Gaz de France, Renault). Gorago esan dugunez, batzutan koletibitate nazionalak edo lokalak elkarte publikuko kapital zati bat bakarrik daduka: orduan ekonomia mistoko elkartea da (esaterako S.N.C.F.-a ekonomia mistoko elkarte bat da bertako kapitaletik Estatuak % 51 dadukala. Gainetiko % 49 konpainia pribatuetako antzinako

jabeen eskuetan geratzen da, beren kapital zatiaren arauera dibidendoak kobratzen segitzen dutelarik).

Frantian Estatuak pisu haundia daduka produkzio osoan, Estatuak kapitalaren % 30 gutienez dadukan enpresak 360 inguru baitira (eta esperientziak erakusten du hirugarren partea dadukanak gehienean berak maneiatzen duela enpresa, zeren beste bi herenak akzionista mordo haundi baten artean banaturik baitaude eta hauek gogo guti eduki ohi dute lehenengo herenaren jabearen iniziatibei kontra egiteko). Hauetaz gainera beste 300 bat filial (zifra hauetan ez dira sartzen P.T.T., ez irratia, ez beste zerbitzu publiko batzu, etab.). Kalkulaturik dago gaur industrian zazpi alokatutarik batek Estatuarentzat lan egiten duela. Enpresa publikoei administrazio publikoak erantsiz gero (ministerioak batez ere), are zifra haundiagoak genituzke. Nazioko kontuen azkenengo agerpenak (Rapport sur les comptes de la nation pour 1960, 82 garren o.) ematen duenez, sektore publiko osoak (enpresak eta administrazio) Frantzian banatzen diren alokairuen % 29 ordaintzen du eta nazioan eginiko inbersioen % 40 seguratzen.

### *Enpresaren hazkuntzak kapital gehigarriak behar ditu*

Enpresa baten jaiotzan eta bizitzan kapitalak zer sorrera eta egiteko duen bukatu aurretik, diogun zerbait enpresak haunditu nahi duenean gertatuko denaz. Batez ere, hazterik nahi badu, kapital gehigarria aurkitu beharko. Behar honen

arrazoiak sinpleak dira: lur berriak erosi bertan etxaleku berriak instalatzeko, makina gehiago erosi produkzioa gehitzeko, alokatu gehiago enplegatu, bere makinentzat lehengaien eta ordezko piezen stock haundiagoa eduki edozein ustekaberi aurre emateko. Nola lortuko du hasierako kapitala haunditzea?

Lehenengo, berak horni dezake bere burua, bere irabazietatik zerbait apartatuz urtero, era heldutakoan, makina, lur, inmueble, eta lehengai gehigarriak erosten gastatuko duena. Gerra ostean Frantzian industriako eta komertzioko enpresek eginiko inbersioen ia hirugarren partea honelaxe finantzatua izan da, inori ezer eskatu gabe. Enpresarentzat autofinantzatze honek abantaila haundiak daduzka. Lehenengo eta bein barkariengana jo beharra kentzen dio, industrialentzat mamu izugarriak, zeren aurreko mendearen azkenetan eta oraingoaren hasieran beren esku baitzadukaten enpresen destinoa, hauen hondamena ala iraupena bankuek kredito bat ematearen ala ukatzearen pentzudan baitzegoen sarritan. Gainera autofinantzazioa merkeago da, irabazien gaineko zergak ordaintzea ebitatzen duelako (ekipo erosketara destinatzen baitira) eta prestatzaileei ordaindu beharreko interesa aurreztu.

Pentsatze apur bat aski da, ordea, enpresei hain ongarri zaien sistima honek nazio osoari nolako okerrak dakarzkion ikusteko. Ez dago inolako segurantzarik enpresek lorturiko eta autofinantzaziora destinaturiko irabaziok ondo enplegatuak izanen diren, hau da, nazioko onari begira. Esaterako Frantziako hainbat herritan askoz hobe za-

tekeen etxe batzu gehiago edo hospitale bat, edo eskola bat egitea, herri inguruetan bost edo sei zerbitzu-estazio distiratsu imini beharrean, bakoitzak nahi eta ez klienteria oso urria edukiz. Segur asko hobe zatekeen azken urteotan elkarte kimiko eta petroliodunek autofinantzazio gutiago egin eta zerga gehiago ordaindu balute: honela hauen irabazia galdu beharrean, Estatuko presupostua gehituko zukeiten eta honek eskola, hospitale, estadio, errenta mugatuko etxe gehiago eginen zukeen, hitz batez, Estatuak egin beharrekotzat jotzen den guztia. Dudarik ere ez hau askoz zuzenago zatekeela, elkarte hauei (oso aberatsak izaki darabiltzaten prezioen neurriz) beren irabaziekin nahi zutena egiten utzi baino.

Hala ere, enpresak autofinantzazioz dezakeen baino kapital gehiago behar badu, bere akzionistengana jo dezake (orduan kapital gehitze bat egiten du, hau da, akzioen emisio berri bat, hiru, bost edo hamar akzio daduzkaten akzionistak aurrengo direla), edo akzionista izan nahiko pertsona guztiengana (orduan kapital gehitzea libre geratzen da nahi duten guztientzat).

Enpresak medio biotarik (autofinantzazio edo kapital gehitze) bat ere erabili nahi ezik, hainbeste urtetarako prestatua eskatuz eskura dezake beharreko dirutza. Orduan obligazioak emititzen ditu eta enprestito haundi bat botatzen, S.N.C.F.-k, Electricité de France-k, O.C.R.S.-k, siderurjiak eta abarrek egin duten bezala (S.N.C.F.-ko kilometrikoak eta E.D.F.-ko "bonsklowat"ak ez dira obligaziozko enprestito batzu besterik, errenboltsoe-

tarako edo sarietarako eskubide damatenak S.N. C.F. kilometrotan edo E.D.F. kilowatiotan).

Laugarren eta azken sistima: hazi nahi duen enpresa batek beste enpresa bat irents dezake edo berarekin elkartu. Irenste edo elkartze honen ondorioa firma printzipalaren ahalmen teknikoa eta finantzazkoa gehitzea da (kapital imintze berri batek eginen zukeen bezala). Aurrerantzean ezein desboltsamen gabe, firma tipiagoaren tailerrak, lurrak eta inmuebleak daduzka. Bere produkzio ahalmena gehitu egin da. Gehienean —elkartze kasuan— lehengo enpresako akzionistei elkarte berriko akzioak ematea izaten da, eta —irenste kasuan— firma irensleko akzioak ematea.

B. *Patente teknikoak*

Enpresa sortzeko edo haunditzeko beharreko kapitala aurkitutakoan, hango eragileak —kapitalista errejimenean kapitalaren ordezkari edo jabe denak-patente teknikoak lortu behar ditu —erosiz edo alkilatuz— enpresak produzitu nahiko gaiak fabrika ditzan.

Nazio kapitalista guztietan edozein produkzio dago egon ere legeak babesturiko prozedimendu teknikoetan oinarriturik. Enpresa batek berak asmatu gabeko prozedimendu berri bat —eta asmatzaileak jabegoaren agerpen publiko bat eginik dadukana— erabili ahal izateko, asmatzailea kontratu behar, edo bere prozedimendua erabiltzeko eskubidea). Patenteen adibideak dozenaka aipa daitezke: ezagunenak publiko nagusiari eta ez es-

pezialistei bakarrik interesatzen zaizkionak dira, hala nola, esaterako, Camus eta Barets prozedimenduak konstrukzioko fabrikazio astunerako.

Asmakuntzen babeste sistime honen okerrak dira gizateriaren konjuntorako eta sobera partzen dituzte asmatzaileen iniziatibak ateratzen dizkion onak. Sarritan enpresek ez dute, alkiler bat ordaindurik ere, beren patentea inork erabiltzerik permititzen, honela beren monopolioari eusteko, desiragarrien litzatekeelarik mundu guztiak irabaztea aurrerapen teknikoekin. Baita ere sarritan enpresa batek patente garesti samar bat erosi duenean, geroagoko patente hobe baten aplikazioa atzeratu egiten du, aurreko patentea amortitu arte (luzaro erabiliz). Eguneroko kontua da enpresa haundiek (amerikarrek batez ere) injineruak enplegatzea beren aktibitateari aplikatzeko moduko patente berrien bila mundu guztian zehar, beste enpresa batzuk jakin aurretik erosi ahal izateko, baina ez inola ere inork baino lehenago erabiltzearren, inork ez erabiltzea seguratzearren baizik. Malthus joko hau nahikoa arrunta da Atlantikoaz handik (non entzute polita hartu baitu prozeso eskandalutsu batzuren bidez). Maila intelektualean malthuskeria agorgarri hau lotsagarria da, nazio batzutan —gai batzuren prezioen beherakada ebitatzearren— egiten dituzten hautsapen aproposkoak bezain lotsagarria: kafea lokomotoren erregaitzat Brasilen, garia galdu edo itxasora jaurtiki, mahastiak erauzi ardoaren prezioak erregula zitezkeenean, meloiak Rhone-ra bota, okela erretegira, etab. Asmakuntzen apropoako agorkuntza nekezago igartzekoa da. Aski da inork muturrik

sartuko ez duen kutxa batean dokumentuak ahazturik uztea. Baina gizateriarentzat eduki ditzakeen ondorioak gai ia fabriflatuen hautsapenak baino are hondagarriago gerta daitezke.

D. *Makinak*

Kapitala bildutakoan eta patenteak lortutakoan, orduan beharrezko da autaturiko prozedimendu teknikoei dagozkien makinak erostea. Hauk sinple samarrak edo oso konplikatuak izan daitezke; orduen oso gostu haundikoak dira Labe altu batek esaterako, bost, mila miloi franko zahar eder balio du eta altzeiru fundizio moderno eta haundi batek —Dunkerque-n imintzen ari diren modukoak, urtean hiru mila miloi tonelada altzeiruko produkzio ahalmena duena— ehun mila miloitaraino balio du.

Honekin argi geratzen da firma moderno nagusiek zer kapital premia haundia dadukaten, automatizazioaren desarroiloak gehi arazi baizik eginen ez duen premia noski. Erraz ulertzen da zergatik gero eta makina automatiko hobeen instalazioa garestiago izanen den. Chicagon makina batek berak bakarrik hiltzen, hustutzen eta sortatzen ditu orduan amabi mila oilasko. Estatu Batuetan saltzen diren kriseilu elektriko ia guztiak gizonen interbentziorik gabe egiten dira. Iragaztegiek gero eta petrolio gehiago garbitzen dute, gero eta pertsonal gutiagoz...

E. *Lehengaiak*

Gehienean fabrikako makinak elikatzeko lehengaien —edo gai erdilanduen-erosketa ez da enpresako zereginik gaitzena. Lehengai hauk hornitzaileei erosiak izan daitezke, edo firmaren beraren mendeko beste enpresa batek ekarriak. Bietarik zein prozedimendu hautatu era batera produkzio klasearen, lehengaien sorburuaren eta fabrikaren garrantziaren gora beheran dago.

Sarritan nazio aurreratuetako firmek nahiago izaten dute —bir-salmentako prezioengatik eta hornitzaileekiko independentziagatik— beharrezko lehengaiak berek egitea erostea baino. Bestalde edonork dakiena da nola nazio industrialek herri atzeratuetan anitz eta anitz lur-landadi edo mina dadukaten. Jabetasun hauen esplotazio kondizioak denbora askotan —gaur ere bai batzu— hain onuratsuak izan dira non indarrez sistimazki eraturiko lapurretaren antz gehiago baitadukate nahiz eta komertzio izenpean.

Praktika hau ez da galdu oraindik: Michelin--Citroen-ek nork jakin zenbat kautxo landadi dadukan mundu guztian zehar; Pechiney-k bauxita meatzak Afrikan (Amerikar eta Kanadar trustekin batera); olio-errota frantsesek egundoko kakahuete landadiak Afrikan, etab. Nazio aurreratuetan ere ba da integraziorik. Esaterako, Lorena-ko siderurjikoek duela urte guti Rhur-ko ikatz minarik haundienetarikoa erosi zuten, handik cock ikatza ateratzeko.

Produkzioko faktoreena bukaturik genuke gizona aipatu beharrik ez balego: berau gabe ez legoke produzitzerik.

F. *Gizonak*

Berarengandik hasi behar nuen baina bildur nintzen hala egitean, zuek, arinki samar, atera zenezaten beste produkzio-faktoreak, sakonean, nahikoa bigarrenkiak direla. Esperientziak erakusten du —zer eginen diogu bada!— gure mendebal gizartean sarritan zailago dela kapitala, patenteak baita lehengaiak ere aurkitzea, gizonak baino.

Bueltarik gabeko gertaera bat da belaun-aldi batzutatik honantz, mendebaleko nazioetan paratu mordo bat dagoela, aldakor nazioen eta garaien arauera eta neurri izugarrietara hel daitekeena.

Ekonomian dena dago gizonaren pentzudan: berak ateratzen eta transformatzen ditu lehengaiak, asmatzen eta funtziona arazten makinak, pilatzen bere ahalmena hamar bidertuko duten kapitalak, erabakitzen zer destino emanen dien etab. Guztiz bidezko da beraz, enpresako produkzio prozesoan garrantziarik haundiena eman diezogun.

Enpresa batean lan egiten duten gizonak bi era diferentetara klasifika daitezke:

1. Beren kualifikazio mailaren arauera. Urrengoz urrengo, beherengo mailatik hasirik, aurkitzen ditugu: peoiak, espezializazio apaleko langileak, profesiodunak (P1, P2, P3), langile xit kualifikatuak, espezialistak eta injineruak, tekniko, administratibo nahiz merkatari izan daitezkeenak. Gorago eta plano desberdin samarrean enpresako organizazio eta zuzenpeneko espezialistak daude, kualifikazio jeneralagoko pertsonala direnak.

2. Dadukaten erabaki ahalmenaren arauera. Beherengo taldean enpresan inolako erabaki ahalmenik ez duen langile pilo izugarria sar dezakeku, betetzaile huts delarik. Ekipo buruak du ia zerbait botere: orduak eta xandak bete daitezen zaindu. Kapatazaren antzeko eginkizuna daduka. Gorantz jarraikirik tailer edo despatxu burua dadukagu, gero fabrikazio unitate bateko arduraduna (sarritan injineru dena) edo komertzio nahiz administrazio sailean zerbitzu-burua, zuzendarien edo zuzendari-ordeen mende zuzenki dagoena. Berez zuzendariak administrazio kontseiluaren mende daude, hau baita aginte nagusiduna, kapitalaren jabeak ordezkatzen dituelako. Izatez administrazio kontseiluak —eta bakar enpresa haundietan ugazabak— gehienean aginte nagusia zuzendariekin partekatzen du, zuzendariok kapitalaren ordezkariak berak hautatuak baitira beren konpetentzia teknikoaren eta baita berengan jar dezaketen fidantzaren neurrian.

*Tenkikoak eta kapitalaren ordezkariak*

Gaurko gizarte kapitalistan joko konplikatua dabil, nolako enpresak halako arauekin, baina dominadore berdin bat: erantzukizunen eta erabaki ahalmenen banaketa zuzendari nagusien —laburki teknokrata pribatuak dei ditzakegunen— eta kapitalaren ordezkarien artean.

Lehenengoek, berezko aginte gosez, baita administrazio kontseiluko partaideak (kapitalaren ordezkari soilak, sarritan ezein kualifikazio gabe zuzentzen duten enpresak darabilen teknikan) bai-

no adituagotzat daduzkatelako beren buruak, erabaki guztiak hartzeko eskubide kentzen diete kapitalaren ordezkariei, sarritan berriz erabakirik inportateenak. Kapitalaren ordezkariek, jakina, eskubide hori ukatu egin nahi izaten diete, baina ez daude horretarako egoera aldekoegian, zeren batetik berek hautatu baitituzte zuzendari hauk enpresako etorkizunari aurre emateko konpetentzat jotzen zituztelako hain zuzen eta bestetik, sarritan oso guti kualifikaturik egoki, ez baitakite zer erantzun teknokratek beren erabakien alde dantzaturiko arrazoiei. Honela eztabaida hertsi bat hasten da akzionisten ordezkarien (aginte juridikoa edukitzearen abantaila dutenen) eta teknokraten artean (hauk haiek teknika askotzarik ez dakitela frogatu ahal izateko nagusitasuna dutenak). Eztabaida honetan, diferentki firmen arauera, enpresako erabaki ahalmena jokatzen da.

Ondo legoke puntu honi luzaz ekitea, gaurko munduko eboluzioan —politiko eta ekonomikoan— garrantzia haundia baitaduka. Baina ez dezakegu hala egin ekonomiako hatsapen kurso honetako barruti laburrean, nahiz eta hauzia interes haundikoa izan eta hizka-mizka zorrotzak atera. Horra, esaterako, Burnham amerikarraren tesisak "managerrei" buruz, edo Ekialde-Mendabaldeko errejimenen elkarganatze hipotetikoa bi munduetan "organizatzaileen" papera era batera zabalduz doala-eta.

Honez gero, argitutzat eman ditzakegu enpresa osatzen duten mekanika ekonomikuko engranaje desberdinak. Orain nola funtzionatzen duten ikus-

tea bakarrik geratzen zaiku. Honetarako galdatu beharko dugu nola enpresak —bere produkzioaren ordainez— lortuko dituen bere gastuei aurpegi eman arazteko gaitasunak eta aterako nahi duen irabazia, eta gero baita galdatu beharko dugu nor geratuko den, azken batez, irabaziekin.

## III. NORA DOA ENPRESAK PRODUZITZEN DUENAZ IRABAZITAKO DIRUA?

Bere produkzioa saldu nahi duen enpresak ba liteke Estatuarengan aurkitzea bere kliente nagusia. Tankeak edo bonbarderoak egiten dituzten enpresek ez dute, gure zorionerako, beren produkzioa merkatu librera botatzen. Halaber makina elektroniko konplikatuak egiten dituen enpresak administrazio publikora eta elkarte nazionaletara joko du batez ere saltzera. Kasu hauetan produkzioaren irtenbidea laster konpontzen da.

Frantziako Estatuak urtero egiten ditu bi biloi franko zaharretatik gorako eskeak. Eska hauk dira: lan haundiak (kanaleak, bortuak, trenbideak, presak, zentro nuklearrak), eskolak, errenta mugatuko etxeak, militar gaiak eta anitz hornitura desberdin, militarren galtzerdietatik etxe publikoak konpontzeko behar den zementuraino edo funtzionarioek behar dituzten boligrafoetaraino.

*Konpetentzia*

Gehienean enpresak kliente asko daduka, hauk halaber Frantziako nahiz atzerriko enpresa konpetitzaileen kliente posibleak direlarik. Beraz anitz burruka eraman behar bere burkideekin, Merkatu Batuak are gordinagotuko dituen burrukak noski, zeren europear merkantzien sarrera erraztuko baitu Frantziara eta gai frantsesen esportazioa "seiren" Europara (gaur seirok bederatzi dira ia) (2).

Lojikaz joko ekonomikoa eskaintza-eskari legearen arauera balebil, produktoreak, klienteria berenganatzeko, prezioak beheratzera beharturik aurkitu behar lirateke (gutienez produktoreen eskaintza konsumitzaileen eskari "efektiboa" baino haundiago denean). Prezioen beheratze honek normalean eliminatu eginen lituzke produkzio-gostu goeregiak daduzkaten eta beraz garesti saltzen segitzen duten enpresak, gostuak behar haina ez gutitzearren.

Egitez mekanismoak ez du guztiz honela jokatzen. Lehenengo, sarritan produktoreek tratuak egiten dituztelako konpetentzia kentzearren edo behintzat zati on bat arintzearren. Bigarren, tratua nahikoa izan ezik, enpresak elkartu egin daitezkeelako, komenentziazko ezkontza bat eginik burruka arriskutsuegiak ebitatzeko.

*Enpresako irabazien banaketa-burrukatik klase-burrukara*

Enpresak elkarren kontra jartzen dituen lehenengo burruka zerrenda honi beste zerrenda bat

erantsi behar zaio, sarritan askoz biziagoa: enpresa barrenean irabazien banaketa dela-eta sortzen den burruka. Saldutakoaren prezioaren banaketako burruka honek bost pertsona sail frentatzen ditu:

1. Estatuak salmenta prezioaren zati eder bat eramaten du, % 20 inguru bataz beste (gutitxoago gai batzutan: ikatz, petrolio elektrika, janari; eta gehitxoago beste gai batzutan: luxozko gaiak, esaterako, elektrodomestikoak). T.V.A. (taxe sur la valeur ajoutée) izeneko negozio zifraren gaineko zerga honi, irabazien gaineko beste zerga bat gaineratu behar zaio, bakar enpresa ala kolektiboa izan aldatzen dena (bakar enpresan ugazabaren errentak zergatzen dira, enpresa kolektiboan berriz elkarteko irabaziak, % 50ko tasaz).

Honi buruz behar beharrezko da jakitea —alderdi funtsezkoa baita— zerga honek irabazi netoa bakarrik grabatzen duela, hau da, elkarteek beren irabazi brutoetarik zati bat makinak amortitzera destinatu ondoren geratzen dena, baita hornituruak (suma deduzituak) egitera stock-aren edo elkarteak daduzkan akzio mobiliarioen ustegabeko depreziazioei baita litezkeen arriskuei ere aurre emateko, eta azkenez irabazi brutoetatik hirugarren zati bat erreserbatzat gordetzen da "egun okerren" prebisioz. Laburpenez bada, irabazi brutoetarik bi herenek irabazien gaineko zergei honela ihes egiten diola kalkulatzen da, bakar enpresetan berriz laurden batek bakarrik ihes egiten diola tasazioari. Elkarteek —gehienean enpresarik sendoenek— diferentzia hau lortzeko modua

zera da, perito fiskalen —sarritan lehenago inspektoreak izanen— aholkupean ibiltzea, hauek erakusten dietelarik zergatitak libratzeko mila katramila legezko. Parlamentuko maioria konserbatzailea eten gabe ari izan da elkarteei ihes fiskalerako erraztasun gehigarriak ematen. Legeak bailmenduriko azken "jokoetarik" bat da holding-elkarte batek (aurrerago ikusiko dugu zer esan nahi duen; elkarte hoietarikoak dira: Sweider, Suez, Forges et Acieries de la Marine, etab.) erdibitu egin dezakeela bere akzio sorta ("balio mobiliarioak" ere deritzatenak): batek holdin-ak bere filialetan daduzkan akzioak hartzen ditu; bestea inbertsiotarako sorturiko elkarte bati uzten zaio. Legeak kasu biotan baimentzen du akzio hauetatiko errenten esonerazio fiskal osoa.

2. Lehengaien, makinen, ideen (patente asmatzaileen) hornitzaileek ere, jakina, beste zati bat daramate enpresako gastuetatik.

3. Obligazionistek ere —kapitalaren prestatzaileek, enpresak beharreko dirutza aurreratu zutenek— urtero kobratzen dituzte beren interesak eta batzutan kapital prestatutik zati bat ere bai.

*Klase burruka: alokatuak akzionisten kontra*

Hiru ordainketa sailok kitatutakoan ere, —kopuru ordainduak legez edo enpresaren eta hirugarren pertsonen arteko tratuz izendaturik daude— enpresari bere sarreretatik zati eder bat geratzen zaio oraindik, aldakor industrien eta firmen arauera eta % 20-tik % 80-ra bitartean edo gehiago

dabilena. Zati honen banaketari buruz azkenengo pertsona talde biek burrukatu beharko dute: alokatuek eta akzionistek.

4. Alokatuek, jakina, ahalik eta alokairurik onenak lortzera doaz beren lanaren ordainez. Orduko eta hileko alokairuaren gehitzeak lortzen saiatuko dira; hobari gehigarriak; edo finantza aldetik berdin dena, lan astearen gutitzea alokairurik gutitu gabe (berrogei eta zortziren ordez berrogei ordu lan egiteak esan nahi du lan ordua % 20 garestiago ordaintzen dela). Gainera alokatuak beren alokairuak irregulartzen saiatuko dira, hileko alokairu bat lorturik orduka ordaintzen denenan, eta hilekoa dutenak alokairu minimo bat garantiturik, paro aldiei eta bizigostuaren gorakadari aurre emateko. Baita burrukatuko dira alokairu zuzenaz gainera diferitua lortzeko ere, gaisotasunei, lan akzidenteei eta zahartzeri aurre emateko. Azkenez prestamen familiarrak gehitzen ere saiatuko dira, alokatu guztien kotizazioz finantzaturiko prestamenak familia ugarien karga arintzearren.

5. Alokatuen nahi hauei akzionistenak kontratzen zaizkie. Hauek alde batetik dibidendo gizenak lortu nahi dituzte (enpresak urtero damaien errenta berek iminitako kapitalaren ordaintzat) eta bestetik enpresan inbertituriko kapitalaren gehitzea.

*Autofinantzazioa alokairu altzatzearen kontra*

Nola egiten da kapitalari plusbalio ezartze hau? Enpresa bateko kapitalaren gehitzeaz enpresa ho-

netako akzioen balioaren gehitzea esan nahi dugu. Dibidendoa enpresak akzionistei eginiko ordainketa da eta ez du, beraz, elkarteko kapitalik gehitzen.

Har dezagun adibide bat. X jaunak Machin enpresaren fundaziorako bost miloi frankotako kapitala imini zuen hasieran. Trukean enpresak aportazio honen agiritzat 500 akzio eman zizkion, bakoitza hamar mila frankotakoa. Z jaunak bere aldetik bi miloi imini eta hamar mila frankotako 200 akzio hartu zituen, etab. Hamar urte geroago enpresak gorantz egin duenez, hasieran baino makina gehiago daduka, lehengai gehiago stock-ean eta pertsonal gehiago enplegatzen. Orain haren balio materiala (zor guztiak oraindutakoan) hasierako balioa baino hiru bider haundiagotzat jotzen da. X jaunaren kapital zatia hasierakoa bera da orain ere: esaterako % 5 (hasierako kapitala 100 miloi zela emanik); Z jaunak ere hasierako zatia bera daduka: % 2. Baina enpresaren oraingo balioa du (15 miloi), baita Z jaunarenak ere (6 miloi). Beren akzioak saldu nahi izanez gero, hiru biderreko baliotan negoziatu ahal dituzkeite Boltsan: horra ezertxo egin gabe kapitala hiru biderturik. Honela eginiko kapitalaren plusbalioa nahi dutenean "mugiaraz" dezakete (hau da diru bihurtu, beren akzioak saldurik).

Egunero nazio kapitalista bakoitzeko Boltsan milaka akzio jabek mugiarazten du honela ezer egin gabe lorturiko kapital gehitzea. Hau argi ikusten da prentsak egunero publikatzen duen akzio "kotizazioen" gorakadan (3). Hamar urtetan (1950-60) Parisko boltsan kotizaturiko akzioen pre-

zioak 6,5 bidertu egin dira... ordu-alokairuena berriz 2,6 bidertu bakarrik. Uste oso zabaldua da akizonistak, iminita dagoen kapitalaren plusbalio zatirik ordaintzeko enpresari eskatzen ez diotenez gero, ez direla alde honetatik alokatuekiko konpetentzian sartzen enpresako sarreren enpleguan, baizik dematzen dena ordaintzen zaien dibidendoen zenbatasuna dela —gure aldion oso urria gehienean—.

Uste hau dudarik gabe arras okerra da. Enpresa haziz badoa, inbersioak gehitzen dituelako da, autofinantzazioari eskerrak batez ere. Gorago ikusi dugu beren ekipo gastuak autofinantzatzen dituzten enpresek beren geroko bizkundea garantitzen dutela makina hobeak edukitzean. Zerikusi zuzena dago enpresaren balio gehitzearen eta autofinantzazioak bizkarturiko inbersioen artean. Akzionistek, beraz, irabazi zati haundi bat inbersiorako eta ez alokairu ordaintzeko izatea lortzean, beren kapitalaren geroko plusbalioak seguratzen dituzte.

Enpresak gero eta makina modernoagoak erosi ahal izateko, akzionistak —eta hauk enpresako zuzendarien aurrean ordezkatzen dituen administrazio kontseiluak— bultzaka ari dira alokairuak firmaren ugaritasunari dagokion baino beharago mantentzeko.

Laburpenez: alokatuen erreibindikazioei akzionisten bi nahi kontratzen zaizkie:

— epe laburrera dibidendo altuak kobratzea

— epe luzera enpresak irabazietatik zati haundi bat bere inbersioen autofinantzaziora destina-

tzea, hala nola produkzioaren eta enpresako balioaren (boltsako plusbalioaren sor arazle) gorakada azkarra gerta dadin.

Aspaldi konturatu da langileria kapital jabeen funtsezko oposizioaz beren erreibindikazioei. Denbora luzez alokatuak eta akzionistak kontratu dituen konfliktoa zera izan da batez ere: alokairuen altzapena-dibidendo banatuen altzapena. Gure egunotan sarritan klase-burrukak alokairuen altzatze eta erregulartzearen erreibindikazioa autofinantzazio gehituaren kontra jartzen du. Akzionistei —errenta haundidunak gehienean, gehienean burjeseriako jendea delako— guti axola zaie enpresak ordaintzen dien dibidendoa altua izan ala ez, zeren batez ere akzioen salmentaz Boltsan lor dezaketan irabazi espekulatiboaren bila baitoaz, enpresako desarroiloaren eta, beraz, hango inbersioen pentzudan dagoen irabazia hain zuzen.

Sarritan aipatzen da (4), arrazoiz aipatu ere, La vie francaise finantza-astekariak asmaturiko kapitalista-eredu baten adibidea, 1947-n miloi bat frankotako baliotan aldizkari honek gomendaturiko akzioak erosi eta 1961-en hasieran 18 miloitako akzio kapitalaren jabe zena. Eta hau bere boltsa ajenteari noizik behin telefonatu besterik ezertxo egin gabe, halako akzioa saltzeko edo bestelakoa erosteko aginduz. Bitarte berean (hamalau urte) Frantziako erdiko langileak bere ordu-alokairua bost bidertu bakarrik egin zuen, hau da, hirugarren partea baino gutiago.

Nor ausar daiteke, zifra hauk ikusirik, gaur klase-burruka modatik pasaturik dagoela esatera, nahiz eta itxurak aldatu aurreko mendeari buruz?

*Gaurko joera sozializaziorantz*

Kapitalismoaren esistentziako 150 urteotako burruka honek funtsezko hiru amaiera eduki ditzake:

Lehenengo hipotesia: enpresa modutsuak alokairuak xit hertsiki mugatzea lor dezake. Kapitalaren ordezkarien garaitia honek permititzen du inbersioak lasaiki autofinantzatzea baita akzionistei dibidendo oso altuak banatzea ere.

Bigarren hipotesia: enpresak batetik ez du dibidendo gizenak banatzea uzterik nahi eta bestetik alokatuan presioagatik alokairu altuak eman behar. Kasu honetan inbersio guti dago eta autofinantzazioak kolpeari igartzen dio. Lehentxoago edo gerotxoago honek enpresaren heriotza dakar, zeren ekipoa zaharturik geratuko baitzaio bere konpetitzaileei buruz, zeintzuk gehiago eta merkeago produzituko baitute prozedimendu modernoagoei esker. Gaur egun inbersioak sakrifikatzen dituen enpresak ez daduka luzaro irauterik.

Hirugarren hipotesia: enpresak alokairu altuak ordaintzen eta inbersio haundiak egiten ditu. Kasu honetan dibidendoen banaketa laburtzen da. Ertzean formula honek dibidendoen supresio osora eraman dezake: enpresa sozialista baten antzeko egoera, akzionistarik gabe. Honelako enpresan alokairuen eta autofinantzazioaren arteko arbitraje kontua erabaki beharra legoke bakarrik (inbersioak autofinantzatu beharrak edozein zirkunstantziatan segitzen du iraun eta hazi ahal izateko). Yugoslabian, enpresarik gehienak sozialdurik dauden tokian, gobernuak dei egin zien en-

presa batzutako langile kontseiluei (enpresa hauetako langileek hautatuei) gehiago eta hobeto produzitzera destinaturiko inbersio gutiago egiteko prozedimendu modernoagoak erabiliz. Beren hautatzaileekin ados eta enpresaren etorkizunerako inbersioak egiteak duen garrantziaren jakile, hala mugatzen zituzten alokairuak non Gobernuak politikaz arriskugarritzat jo baitzuen.

Nazio kapitalistetan alokairuen eta autofinantzazioaren arteko arbitrajea zerak berezten du, enpresak inbersioei esker lorturiko plusbalioaz akzionistak bakarrik jabetzen direla (edo ugazaba, bakar enpresa bada). Nazio hauetan aitzindari langileek —sindikal bahiz politiko— enpresa nagusirik gehienak sozialdu egin behar direla oihuztatzen dute, kapitalista apur batzuk denen ahaleginaren frutuak beren onerako bakarrik konfiskatzea eragozteko hain zuzen (5). Baina nahiz eta geroko lorkizuneri buruz ados egon, oraina eztabaida iturri da. Sindikalista edo politiko ezkertar batzuk uste dute desiragarri dela anti-autofinantzazio bezalako zerbait zabaltzea honako sloganez: "Beharrezko da gaur eta beti alokairuak gehitzea; inbersioak hor konpon".

Honela diotenek, jakina, laster iritzia aldatuko lukeite enpresaren zuzenbidean erantzukizun benetakorik balute. Batez ere jokabide praktiko bat defenditzen dute, sistima kapitalistaren iraupena epe laburrera eta luzera egintzat ematen duena. Nik neurez hobe litzatekeela uste dut garbi hitz egin lezaten, oker ulertzerik ez egoteko eta langileei ez ezkutatzeko zer inportantzia haundia dadukaten inbersioek gaurko mundu ekonomikoan.

*Alokairuak ekintza sindicalaren pentzudan daude*

Klase-burruka honek fase desberdinak eduki ditu bere historia luzean zehar. Ez ditut nik hemen laburtuko, Ikasketa Sozialiste Zentroko beste kurso batzutako gai izanen baitira. Gogoeta batzu bakarrik egin nahi nituzke honetaz.

*Lehenengo gogoeta*: Ehun urtetatik honantz historiak erakusten dauku alokairuen maila batez ere —nahiz eta ez bakarrik— burruka sindikalaren indarraren pentzudan dagoela. Bere "L'action sindicale ouvrière" lan nagusian Andre Titano irakasleak, Frantziako hauziari buruzko bere azterketak eta Estatu Batuei buruzko azterketa amerikarrak aipatuz, erakusten du huelgara maiz doazen profesioak, zabalkunde haundiko hizparringi sindikalik ateratzen dutenak, filiatuen portzentaia oso haundia dadukatenak, hauxek direla hain zuzen alokairurik altuenetako profesioak. Are garrantzitsuago da oraindik ondorengo zihurtapen hau: baldin, ez alokairuen oraingo maila, baizik beren eboluzioa hain harotan aztertzen bada, berriro ere, ezepzio bakan batzuz aparte, bi gauzak batera doazela ikusten da: hau da, alokairu gehipenik haundienak sindikalismorik ekinkorrenenko profesioetan aurkitzen dira. Hau egia da hala Estatu Batuetarako nola Franziarako. Ez dakit beste nazioetarako ere egia den eta ezin egiztatu gaiari buruzko estudiorik ez dagoelako. Baina eskubide dugu koinzidentzia hutsa bakarrik ez dela pentsatzeko.

Konstatazio hau arras garrantzitsua da. Behar bada zuek ere uste duzue —sindikalista zaharrek

aitortu duten bezala— aspaldiko jakindurian argi dagoen ebidentzia bat dela hau: "Ezer eskatzen ez duenak ezer harrapatzen ez; asko eskatzen duenak guti harrapatzen; asko burrukatzen denak asko eta erdi harrapatzen". Egia aitor, aspaldi dakigu kontu honen berri baina xit garrantzitsu da zehazki eta matematikazki frogatzera heldu izatea buletarik gabeko inkestetan eta zifra ofizialetan oinarriturik. Gehienean, hala ere, langileen erreibindikazioek honako arrazoiketa atzerakoiekin topo egiten dute: alokairu gehitzeak produkzio gostuak astunduko lituzkeela, alokairuak gehitzen dituen enpresari kalte eginik enpresa konpetitzaileei buruz. Langileek soldata gehitzeko eskatzean, enpresaren hondamendia lekarkete (eta ondorengo paroa). Arrazoiketa hau (kasu bazterki batzutarako bakarrik balio duena, enpresa ia konpetentziari eutsi ezinka dagoenean, edo gostu-prezioen gorakadak derrigor salmenta-prezioen gehitzea lekarkenean) historiaz gezurtaturik uzten dute Andre Tianoren konstatazioek: profesio batzutako alokairu altuek, ekintza sindikal biziz lortuek, ez dute adar hauetako martxa onik eragotzi. Bakar bakarrik kapitala behartu dutela bere produkzioa arrazoitzera eta irabaziak (banatuak edo autofinantzaziora destinatuak) pizka bat mugatzera.

Beste liburu batek —zeinen irakurtzea ere gomendatzen baitautzuet—, "Les disparités géographiques des salaires", Philip Madinier-enak, agertzen du nola langileen ekinak beren alokairuak gehitzeko, ugazabek dioten ondorio ondagarririk eduki beharrean, enpresen modernokuntzarako ziritzat balio duen. Izan ere, langileek eskaturiko

alokairuak ordaintzeko, enpresek beren produktibitatea gehitu behar ekipoa modernoturik. Krisistxo hau gaintzen dutenek —ez baitute denek lortzen— efikazia eta ekipo askoz haundiagorik dadukate alokatuen bultzada motelago den tokietako enpresetan baino. Amerikako esperientziak ere erakusten du hango enpresetan ordaintzen diren alokairu altuak —Amerikako erdia Europakoa baino askoz gorago dago— ez direla Estatu Batuetako aurrerapenaren atzeragailu izan, akuilu indartsu baizik.

*Neokapitalismoaren metodo zahar eta berriak*

*Bigarren gogoeta*: Alokatuen eta akzionisten arteko demari buruz jarri nahi dautzuedan bigarren gogoeta klase-burrukari oraingo fasean dagokiona da: kapitalaren ordezkariak —administrazio kontseilua eta zuzendari delegatuak— langileekiko harremanak hobetzen saiatzen direla. Fase neokapitalista honek alderdi oso desberdinak daduzka. Batzutan empresariak alorkatuak sakabanatzera dabiltza hobeto maneiatzeko. Batzutan haien eskerrona irabaztea eta haik enganatzea nahi dute. Batzutan haik kapitalista tipi, haundien lagun bihurtzea nahi dute.

— *Langileak sakabanatu*: Honetarako anitz metodoz baliatzen dira. Arruntena alokairuak ahalik desberdinentzea da (sindikatoei aurre ematea alferrik bada). Izan ere ekintza sindikalaren kondizioetarik bat alokatuak elkarren kide sentitzea izanik, alokairu baremoak, ordain erak, hobari pertsonalak, etab. aniztuz gero, alokatu bakoitzak

lagunengandik soldata diferentea edukitzea lortzen da, nahiz eta egiten duten lana berdina edo antzekoa izan. Esaterako esan izan da, pizka bat gehiegiturik bada ere, Simcak ez diela bi alokaturi era berdinez, baremo berdinez ordaintzen. Sindikatoek soldata gehitzeei buruz oldarraldi jeneral bat jo nahi duten egunean, oztopaturik aurkitzen dira mugimenduaren batasuna zulatzen duen kasu partikular mordo batez, eta sarritan alokatuak —erreibindikazio konseina zabalegiekin guti kideturik sentitzen direnak— mugimenduan parte hartzeko adoregabetzea lortzen dute. Langileen uzkurtasun hau okerragotu egiten da asiduitate hobariak galtzeko bildurrez, enpresak hainbat denboratan —hile bat, hiruhile bat, seihile bat— paroan egon gabeko edo huelgarik egin gabeko langileei bakarrik ordaintzen dizkien hobariak.

Gehienean metodo hauetaz gainera koadro sindikalen kentze saioak egon ohi dira, dela indarrez, dela arrazoiz: enpresako buruzagiak konbentzi arazi nahiz dabiltza klase-burruka egia izan zela baina gaur gaindurik dagoela, sindikalismoa iritzikera ia galdu haren arrasto bat besterik ez dela, gaurko joera dela burruka arkaiko honen ordez elkarlaguntza imintzea enpresa, langile guztien etxe peoitik zuzendariraino. Elkarlaguntza hau benetan efektibo dadin, koadro batzu salatari egiten ditu, sindikatoen pareko beste bigarren jerarkia bat jarririk. Metodo neokapitalista hauen azken helburua "sindikato-enpresa" bat sortzea da, zuzendaritzaren mende guztiz eta "garai egokian" halako abantailak edukitzek orpomesen morroikeriari dagokiona. Hau lortutakoan, langileen sa-

kabanatzea —edo anestesia— halakoa da non enpresak langileekiko bakea behin betiko irabazi duela uste baitu.

— *Langileak atzipetu*: Gehienean bigarren metodo hau lehenengoaren osagarri da. Anitz enpresak —Renaultek esaterako— bertan lan egiten duten langile aitzindariak zuzendaritzaren zerbitzuko koadro bihurtzen ditu, beren kualifikazio profesionaletik gora ordaindurik. Renaulteko Zuzendaritzako jende batzu, eginkizuntzat hain zuzen huelgen errepresioa eta sindikatoen erreibindikazioei kontra egitea dadukateank, behinolako sindikalistak dira, era batera beren kualifikaziotik gora kobratua eta lagun zaharren erreibindikazioen garaitiari lagundu ahal diotela sinesteko makalkerian erori direnak.

Alokairu altuen teknika ere erabiltzen da sarritan, sindikatoek jarriak baino haundiagoak. Alokairu normalari "etxeko" abantaila apartekoak" erantsi behar zaizkio, langileek enpresatik alde egitekotan hartuko ez dituztenak, (hain kualifikazio profesionali loturik doazelako). Abantaila pertsonal hauetaz gainera enpresakoei bakarrik dagozkien erraztasunak daude: seme-alabentzat opor koloniak, gurasoentzat hatseden hotelak, zaharrentzat asiloak, haurtxoentzat amategiak, etab. Sarritan alokatua buruz ere berenganatzeko eta harreman onak zaintzeko, "enpresako egunkari" bat ere ateratzen eta banatzen dute, oso ondo agertua, luxozko paperez, hala alokatua nola familia enpresako bizitzaz ardura araztera destinatua.

— *Alokatuak kapitalista tipi bihurtzen saiatu*: Esaterako Pechineyk duela bi urte bere kapitalaren % 1 errepresentatzen zuten akzioak banatu zizkion hango pertsonalari (enpresako alokatu bakoitzaren antzinatasunaren proportzioz). Beste adibide bat: Volkswagen, elkarte nazional aleman bat zena, salgai jarri zuen Alemaniako Gobernuak 1961-ko martxoan (bere kapitaletik % 60-ko konkurrentziaz). 1.400.000 hartzaile azaldu ziren —gehienak errenta apalekoak— negozio biribila eginik (hiru hile geroago Volkswagen-go akzioek hasierako balioaren doble balio zuten boltsan). Gaullдarrek hirugarren formula bat asmatu dute langileak enpresako zuzenpenean soziotzeko (baina enpresako akziorik eduki gabe horratik). Ez dago ia esan beharrik honen eragina barregarria dela, Alemaniako "kojestioaz" konparaturik batez ere, zeinek, oinarri beraren gainean, kapitalaren eta lanaren ordezkariak soziotzen baititu ikatz minetako eta altzeiru fundizioetako administrazio kontseiluetan.

### *Sindikatoek ezbaitik tankera sozialistako kontratakera jotzen*

Zein izan da sindikatoen erantzuna engainio eta integrazio saio hauei? (6). Transizio aldi batean, organizazio sindikal guztiek —C.G.T.-k izan ezik— serioan pentsatzen dituzte ugazabek proposaturiko abantailak. Sarritan abantaila hauk frogatzea merezi zuela uste zen. Urte batzutako kontua bakarrik izan zen.

Gaur ba dirudi sindikatoek —dudarik gabe

C.G.T.k, baita C.F.T.C.k (gaur C.F.T.D.) eta sarritan Force ouvrière-k-susmoz begiratzen dietela, etsaigoaz ez bada, ugazaben propasamendurik gehienoi. Honek ez du esan nahi beste gabe ukatzen dituztenik. Sindikatoak ongarri zaien eta lehengo egoerari buruz aurrerapen den guztia ateratzera doaz. Baina galbidetzat edo arrisku gehiegikotzat dadukaten guztia ezesten dute. Esaterako ontzat hartu dute alokairu minimo garantituaren jarpena, soldata haundaik ordaintzeko enpresa batzuren politika, etab. Baina, jakina, sindikato guztiek ukatzen dituzte enpresako egunkariak (ugazabek atereak), delegatuen saldukeria (eliminazioa ez denean), sindikato-enpresa hertsi eta esklusibistaren ezarpena, etab.

Garai batetik honantz sindikalismo gaztea —batez ere C.F.T.C., baita C.G.T. eta Force Ouvrière ere— ugazaben teoria berriak langileriaren onerako bihurtzeko ahaleginetan dabil. Jokera honen zaleek honela arguditzen dute: "enpresa geurea bada, geure etxe dugu; ugazabek konsekuenteak izan beharra dadukate eta argi esan zeintzu diren gure eskubideak enpresako zuzenpena jagoteko, langileen kontratazio akontrolatzeko, geroko inbersioak erabakitzeko, alokairu politika zuzentzeko, etab.". Gaur sindikalistek enpresariek nahi dituzten "enpresako giza-harremanen" kontra, fabrikako zuzenpe neskusiborako ugazaben eskubid eadeamtzen dute.

Honek bere bultzatzaile izan nahiko sindikalistentzat formacio ekonomiko eta politiko xit sendoa eskatzen du, zeren ugazabaren edo akzionisten ordezkarien) eskubidea dantzan jarriz batera,

argi jakin behar baitute nora heldu nahi duten, zer sistima ekonomiko eta politikorantz jo nahi duten. Baita ere honek esan nahi du sindikalistak, erreibindikazio guztiz berrikor eta iraultza jiteko hauk indartzeko, presio teknika berriak sartzen ari direla, ugazabei langileen eskabide berriak betearazte alortzeko modukoak. Denok konturatzen gara sindikalista hauek aupaturiko enpresa konzepzioak sozialista kutsu garbia dadukala.

Hona berriro "sozialista alderdi" baten buruera, zeren ez sindikatoek baitadukate berak bakarrik burruka agiriki politikora jotzerik, ez ezkerreko partiduek (efektibo makalez eta eragin laburrez) pentsa baitezakete gaur beterearekin dematzerik industriako —eta ahal nekazaritzako baledi— konfederazio sindikal haundien laguntzarik gabe. Gauzen izateari sakonki dagokion partidu-sindikatoen elkargo honexek bakarrik eman diezakee batzuri eta bestetzuri garaitzeko posibilitate haundirik, hauzi politikoei eta ekintza sindikalari buruz gaur nabari den desaxola giroan.

## IV. ENPRESA ARTEKO HARREMAN BERRIAK GAURKO EKONOMIAN

Enpresak obizitzari buruzko hasi-masiak bukaturik genituzke gure azalpena gaurkotzerik komeni ez balitz enpresen elkarren arteko harreman berriei ekinez. Firmak berak ahalegindu dira, arlo

honetan ere, produkzio ere modernoetara egokitzen.

Enpresak elkar jan beharrik burrukatzea pasaturiko kontua da. Gaurko ugazabek maila guztietan konpetentzia leuntzera dabiltza, guztiz kentzerik ez dagoenean. Hiru arrazoi nagusigatik:

*Lehenegnao*: Konpetentzia gero eta garestiago ateratze nd aI.bnersioak dozenaka milaka miloika kontatzen direnean, ugazabak ez daitezke kopletan ibil egundoko gastuak egiten gero gaizki erabilirik ikusteko konpetitzail ebatek klienteria zati on bat kendu diolako. Ez dago publizitate kanpaina bati emateko ere (milaka miloi gostatzen dena gainera), hemen ere beste batek aurrea har diezon arriskuturik. Onena akordu batera heltzea.

*Bigarrena*: Ugazabek nekez arriskatuko dute inbersio haundirik, konpetitzaile batek probetxa litzakeen adiuntza-gorabeheren kontra babesturik egon ezik. Beharrezko hornitura gastu izugarrien amortizazioari ez datorkio bat ere ondo salmenten irregulartasuna, konpetentzia desordenatuak eragina.

*Hirugarren*: Inbersioak gero eta garestiago izanik, sarritan erosoago gertatzen da elkarrekin egitea. Oraindik ikusten da inoiz enpresa automobilgin haundi batek fabrika berri haundi bat egitea (Citroenek, Rennes-en; Simcak, Poissy-n; Renaultek, Cleon-en). Baina gaur egun finantzaz litekeenaren mugan gaude honi buruz. Esaterako siderurjian, hornitura gastu haundiak sarritan filial batzuren artean ordaintzen dituzte. Dunkerke-ko altziru fundizioa, Usinor-ek bakarrik egina, ezepzio garbia da.

*Soka: mila era desberdinetako prozedimendu bat*

Konpetentziaren taxuketa hau gehienean bi eratara egin ohi da: sok aedo konzentrazio.

Soka mila era diferentetara egin daiteke, zeren mila era diferentetara baita posible klienteak enpresen artean banatzeko adostea. Siderurjia aleman-frantsesek honelakoxe akorduak egin zituzten gerra bien arteko aldian, ez-agresiora eta bakoitza bere nazioko klienteriari lotzera elkar hizpeturik. Prezioei buruz ere ados daitezke: hona Frantziako siderurjiaren edo munduko petroliogintzaren kasua, non prezioak Mejikoko Golfoko merkatuari buruz izendatzen baitira.

Produkzioaren kopuruari buruz ere egin daitezke akorduak: hona Frantzian olioaren kasua, zeinen produkzioa firmako mugatu egiten baita enpresek elkar harturik, eta firma batek dagokion kopura gaintzen duen bakoitzean, indemnizazio bat ordaindu behar die besteei. Publizitateari buruz ere har dezake elkar, publizitate gastuei goi bat ezarririk, firma bakoitza ez gaintzera konprometatzen dena, honela gastu hondagarriak ebitatuz. Esportazioak ere sar daitezke akorduan: merkatu atzerritarren banaketa firmen artean edo elkarrekin saltzeko elkarteak sortu (oihalgintzan eta konstrukzio elektrikoan bildu dira honelako elkarteak). Inbestigazio gastuen kopurua ere izan daiteke akordu-gai: esaterako siderurjiak denen laborategi bat montatu du, gastuak inbestigazioez probetxatu nahi duten firma guztien artean berdinean direla.

*Firma batzuren administrazio berdinak*

Soken eta laster hitz eginen dugun bigarren konpetentzia mugakeraren —konzentrazioaren— artean bide endira, firm abatzuk administrazio berdinak edukitzeko politika dago.

Esaterako, Frantziako 100 enpresa pribaturik haundienak guztira 975 administrari biltzen duten administrazio kontseiluk zuzendurik daude. 975 administrariotatik erdiak —hau da, 473— 100 enpresa hauetarik batzutako administrari dira era batera. Esaterako, X jauna hain elkarte kimikuko administrari da, eta era batera hain elkarte petrokimikuko edo hain elkart emetalurjikuko. Hiru elkarteotako administrarikideengan erabil dezake bere ukondoa eta berdin hiru enpresetako zuzendariengan ere, de la bera administrari den hiru elkarteen kontratu onurakorrak zerratzeko, dela elkarte hauen arteko burruka leuntzeko, berez konpetitzaile badira.

Honelako baten jokoa gerragin biren Goi-Estatuetan sarturik dagoen jeneral baten antzekoa da. Zehaztasun gehiagotan sartzerik ek dudanez gero, puntu honi buruz Houssiaux irakaslearen liburu nagusiari natxeko, "Le pouvoir de monopole" deritzana (edit. Sirey).

*Konzentrazioa: 1 zaio 400-ni*

Konpetentziaren bigarren mugakera nagusi hau bi enpresa soziotzean dago, dela irenspenez, dela berdintasun mailako elkarpenez. Kapitalismoa bera bezain metodo zaharra izanik, hamarkada ba-

tzutatik honantz indar haundia hartzen ari da. Hain honlea da hau non zihurtzat jo baitezakegu Frantziako industria eta komertzioa gehiago ezineko konzentrazio prozeosan doazela.

Zifra ofizialek diotenez (7), 4.300 firmak, hau da, enpresa guztietatik % 24-k bakarrik egiten du Frantziako industria eta komertzioko negozio multzorik ia erdia (% 45,8). Beste era batera esanda, laurehundik enpresa batek egiten du Frantzian gainetiko 399-k haina negozio. Alemanian ere berbera dago, %, 15 firmak (600-dik batek) egiten baitu % 45 negozio zifra. Estatu Batuetan konzentrazio gehiago dago oraindik, 200 enpresarik inportanteenek egiten baitute eskulan industriako negozio zifratik % 24.

Alokairuei eta alokatuei buruzko estadistikek (8) baitesten dituzte ohar hauk: Frantziako alokaturik gehienak industria eta komertzio enpresetatik %, 7-n bakarrik enplegaturik daude, eta heren bat % 0,1-n. Dudarik gabe konzentrazio gradoan gorabehera haundia dago zein adar izan, nahiz eta dena kego gnogor konzentraturik: petrolioan 13 enpresak hartzen du negozio zifratik % 97; siderurjian lau taldek kontrolatzen du altzeiru frantseseko bost laurden; kimikan % 3 enpresak daduka negozio zifratik bi heren. Automobilgintzan hiru enpresak fabrikatzen du % 85 kotxe, etab. Gai honi urrengo kapituluan ekinen diogu berriro.

Aipa berri dugun konzentrazio hau horizontala da, hau da, produkzio mailaka. Baina konzentrazio bertikalik ere ba dago: kasu xit bakana Frantzian, baina ugaria Alemanian. Esaterako

Krupp-ek bere talde izugarrien aktibitaterako (100.000 alokatu baino gehiago) beharreko guztia daduka produkzio adar desberdinen barrenean: altzeirugintzarako beharreko ikatza ateratzen duen minetatik, altzeiru honen (metalurjia, transporte-gai eta barkugintza) eta loturik doazkion beste gaien transformazio industriaraino (hortz artifizialen moldegintza), siderurjian zehar, itxas konpainia, elkarte merkatari eta abarretik jarraikiz. Laburki, industriazko eta komertziozko inperio osoa. Egia esan, Krupp ertzeko kasu bat da, baina honek ez du esan nahi bakarra denik (esaterako, Schneider, nahiz eta grado apalagoz).

*Talde tipiek kontrolaturiko firma haundiak*

Nola daiteke arlo ekonomiko hain zabalen kontrolik? Erdiko frantsesak, lojiko eta demokrata, sarritan uste du enpresa bat kontrolatzeko, enpresako kapital osoaren ez bada, gutienez maioria absolutoaren jabe izan behar dela eta administrazio kontseilua konrtolatzeko derrigorra dela % 51 akzio edukitzea.

Oker galanta da hau. Frantziako eta atzerriko errealitatearen azterketa ganorazkoak garbi erakusten du elkarte bateko kapital zatitxo bat nahikoa dela sarritan hurakontrolatu ahal izateko. Esaterako Société Nationale d'Investissements-ek kapitalaren % 3-z bakarrik kontrolatzen du Air Liquide. Rotschild Bankak eta Compagnie Generale d'Electriiité-k kontrolatzen duten bien artean (batek % 2 kapitalez eta besteak % 1-z) Pechiney trusta. Halaber Rotschil Bankak eta Société Na-

tionale d'Investissements-k % 3-z bakarrik kontrolatzen dute Kulmann talde izugarria. Ere berean Frantziako eta Europako konstrukzio enpresa elektrikorik haundienetarikoa, Thomson-Houston-a, hiru talde kkontorlaturik dako kapitalaren % 7-z bakarrik, akzio sorta tipi hau hirure nartean banatuz: Banque d'Indochine, Société des grands Travaux de Marseille eta Sofinax beljikarra. Zeizugarria, Poliet-et-Chausson, Banque de Paris et mentu, iheltso et abeste nahasigintzako enpresa des Pays-Bas-ek kontrolatzen du (kapitalaren % 9-z bakarrik), etab.

Honelako anitz eta anitz adibide aipa genezake nola kapital zati tipien jabeek produkzio talde handiak kontrolatzen dituzten ikusteko. Dudarik ere ez ba dagoela ezepzio nabarbenik, firmako kapitalaren jabe familia bakarra dena (Michelin, Citroen, Schneider, Prouvost, etab.) eda akzionista taldetxo bat (De Wendel, Simca, Fiat, zeinetan Crysler-ek kapital zati dezentea baitaduka). Baina estruktura kapitalisten eboluzioak lehenengo formula (taldearen kontrola akzionista guti batzuren aldetik) ugariendu du askoz.

Zergatik da honela? Bada, akziozko elkarteek —enpresa nagusi ia denek— hala funtzionatzen dutelako egitez nola % 80-k hauteskundeetan inoiz parterik hartzen ez duen eta % 10 beti hautatu gailenen ustera makurtzen den demokraziek bezala. Kondizio hauetan, administrazio kontseiluko pertsonak hautatzerakoan, nahikoa da talde tipi batek oraingo kontseiluaren kentzea ala segitzea erabakitzea, hauek agintea utz ala uts dezaten. Arazo honek beste galdera bat egitera garamatza

zuzenki: zergatik elkarteko hautatzaileek —hau da, akzionistek, zeren berek bakarrik baitadukate boto eskubiderik enpresako geroa eztabaidatzean, langileek gai honetan inolako eskubiderik ez dutelako (9)— ez dute hautesekundeetan ia parterik hartzen? Arrazoi sinple bategatik, ez direlako enpresako erantzule sentitzen (legeak suposatzen eta agintzen duenaz kontra).

Elkartetik axola zaien bakarra —horrexegatik erosi dituzte akzioak— ez da enpresaren etorkizuna enpresa bezala, Boltsan atera dezaketen irabazi espekulatiboa baizik (eta bide batez beren akzioek damaietan dibidendoa). Elkarte nagusietako akzionistarik gehienak, nahiz eta arretaz segitu finantza egunkarietan beren akzioen balioaren gorabeherak (egunerokoek akziorik ezagunenen kotizazioak ekartzen dituzte), egitez ez dira enpresako zuzenpenaz bat ere arduratzen eta esku trebeagoei (administrazio kontseiluari) uzten diete enpresa gora ateratzeko ardura. Une honetatik aurrera enpresako zuzendaritza —hau da, urteko batzar jeneraletako maioria— hartaz arduratzen direnen eskuetan dago: "akzio sorta sendoe"n jabeak, gehienean industrialen eta finantzarien "familia haundikiak", edo sarriago banku talde nagusiak (10).

### *Negozio bankak eta holding-ak*

Banque de Paris eta Pays-Bas-ek hogeitamar elkartetako administrazio kontseiluetako buruzagitza edo buruzagi-ordetza dadukala esan izan da eta gainera administrari postuak beste berrogeita-

mar enpresa haunditan. Banque de l'Indochine-k —hain gomuta zorigaitzekoak— hogei buruzagitza eta hirurogei eta hamabost administrari plaza daduzka bere aldetik. L'Union Parisienne-k, beste negozio banka haundi batek, hogei buruzagitza eta berrogei eta hamabost administrari aulki daduzka. Standard Oil of New Jersey (ESSO amerikar talde famatua) gorago dago oraindik, mundu guztian zeharreko 300 enpresatatik gora kontrolatzen baitu.

Finantzazko integrazio honek zehatzago damaiku benetako konzentrazioaren berri, negozio zifren banaketari buruzko aurreko zifrek baino. Fenomeno hau adierazteko esaera famatu bat zabaldu zen gerra aurrean, gehiegizko baina adierazkor: "Frantziako ekonomia berrehun familiak kontrolatzen du bere golkorako".

Dena dela, elkarte nagusirik gehienen kontrola negozio banken edo talde finantzarien aldetik asko erraztu da —akzionisten desaxolaz gainera— azken 50 urteotako estruktura kapitalisten barreneko eboluzio azkarragatik:

1. Modernotu beharrak eta beraz gero eta inbersio haundiagoak finantzatu beharrak enpresa nagusien bahimendua erraztu du beharreko kapitalik aurkitu ezin edo beharreko inbersioak errentakor izateko mailaraino produkziorik altzatu ezin zuen anitz eta anitz enpresa tipiren artean.

2. Gero enpresa nagusiak ere kontrolaturik geratu ziren, arrazoi berdinengatik, lehenengo erdi garrantzidun bankengatik (hauen kapitala aurrerapen teknikoaren pareko inbersioak finantzatze-

ko nahikoa zen bitartean) eta gero banku talde askoz sendoagoengatik, negozio bankekin (Indochine, Paris et Pays-Bas, Union Parisienne, Lazare, Rotschild, Dreyjus) harremanduak, banka hauk zuzenki sartzen ez zirenean.

3. Hamarkada batzutatik honantz haro berri batean sartu gara: inbersio elkarteen eta holding-elkarteen haroa. Akzionistak Boltsako akzioen gorabehera kaltegarrien kontra zaintzeko ardurari dagozkio lehenengoak. Arriskuak laburtzeko molde berriko elkarte bat sortzen da: inbersio elkarteak ez du berak ezer produzitzen, elkarte haundietako akzioak erosteaz konformatzen da. Ba liteke akzio hauetariko batzu beheratzea, baina beste batzuk, asko edo guti, gora eginen dute eta guztira inbersio elkarteko akzio sortaren balioa gehituz doa beti. Inbersio elkarteko akzioen jabeek, beraz, elkarrekin daramatzate elkarteak daduzkan akzioen gorabeherak.

Holding-en sorrera ere oso joko zuhurra izan da kapitalisten aldetik. Talde finantzari edo industrial bateko akzio guztiak aparteko elkarte bati uztea da hau, Boltsako jestioaren ardura eraman dezan. Holding-elkartea ez da bat ere arduratzen akzio bakoitzari zer produkzio dagokion jakiten, edo produkzio hau gehitzerik ala gutitzerik komeni den. Hau oinarri elkarteen kontua da. Axola zaion bakarra karteran daduzkan akzioen balioa ahalik gehientzea da eta horretarako burutsuki sal-erosten du Boltsan.

Estruktura kapitalisten oraingo eboluzio unean, holding edo inbersio elkarte batek, konturatu ere gabe, eta batez ere enpresek zer egiten duten ar-

duratu ere gabe, kontrola dezake produkzio elkarte bat (% 2,3 eta 4 kapitalez bakarrik).

Bere kartera jestionatzen duten organismoen jokabidetik harako boltsako irabazia bakarrik axola zaio.

## V. KONKLUSIOA: DEMOKRAZIA EKONOMIKOAREN ALDEKO BURRUKA

Hona kapitalismo aurrelariaren egoera. Konjuntoko egoerak azalduriko koadro honen gero eta antz gehiago edukiko du.

Ez dago abotsik jaso beharrik errealitate honetaz mintzatzeko eta bertan nabarben arazteko —finantzarien zuhurtasunaz gainera— alderdirik onartezinenak.

1. Kapitalismoaren eboluzioak apurka —baina gero eta garbikiago apartatu egin ditu produkzio— lana (hau enpresako alokatuen bizkar utzia) eta ekonomiako zuzendaritza (gero eta urrutiagoko akzionisten delegatuei emana).

2. Produzitzeko arrazoiak eta produzituriko frutuak halaber, urrutitu egin dira langileengandik, hauk gero eta tresnago bihurturik eta ez beren usteak ez osteak bost balio duelarik. Zer harreman egon daiteke enpresa bateko langileek pentsatzen dutenaren eta holding-elkarte bateko zuzendariaren artean, honek asko enpresa hori denik er ez badaki nahiz eta kapitala berak kontrolatu ez-zuzenki (enpresa egitez bere pentzudan terainoko akzio piloa baitaduka karteran)?

3. Akzionistarik gehienak enpresako gidaritzaz desaxolatu ahala, zuzendariek, teknikoek eta administratiboek gero eta toki inportanteago hartzen dute. Berak dira, gorago aipaturiko arrazoiengatik, akzionistek egokientzat jartzen dituztenak enpresako etorkizuna zuzentzeko; ugazaba bakarrak enpresa beste gustien ordez maneiatzen zuenean baino iniziatiba askatasun gehiago dadukate; beren buruen etorkizuna ere zuzentzen duten firmaren gorabeheran dago.

Honela langileak eta hiritarrak ugazaba industrialen begipe zuzenetik aldenduz doaz, baina baita, ordez, eroriz ere finantzarien urrutiko begipera eta beren aginte propioa nahi duten teknokrata alokatuen hurbilekora.

Non dago demokrazia nahas-mahas guzti honetan? Zer toki ematen zaio langile multzo nagusiari, bizitza ekonomikoaren iturri eta honen hobekuntzan arduraturik aurrenengo denari?

Maila honetan oinarrizko nozioak ere, arlo politikoan ere bai, eztabaidagai dira. Egoki al da nazioko destino jenerala, geroko belaun-aldien etorzuna, ordezkaritasun demokratikorik gabeko minoria bi hauen esku uztea? Ez horixe.

Bidezko da beraz, enpresen funtzionamenduari buruzko saio hau, gaurko eboluzioaren deskripzio patukoi hutsean geratu ez ezik, deihadar larri bat izatea burruka politikorantz. Langilerik gehienek, hiritarrik gehienek ez dezakete gaurko eboluzioaren alde joka, gero eta demokrazia barregarriagoa ikusterik nahi ez badute. Demokrata buru egin eta kapitalismoaren eboluzioak dakarren —eta

anitz sektoretan ia etorrita dagoen— gauzen egoera ekonomikoa onartu, hori ez da posible. Zer demokrazia modu litzateke nazioko zoria orain eta gero baldintzen duten erabakiak minoria urri batek hartuko lituzkeena, nazioaren mandaturik gabe eta sarritan maioriaren iritziaren kontra jokatuz?

Beraz gaurko munduko enpresetako bizitzaren eta eboluzioaren gogoetak erreibindikaziozko burruka sindikalera ez ezik, burruka politikora garamatza, helburua izanik hiritarrik gehienen —beheko eta erdiko gizarte mailako langileen— abotsa entzun dadila eta erabaki ekonomikoetan parte har dezala hala nazio mailan nola enpresen zuzenpenean. Epe luzerako helburu politiko sozialistarik gabe, berehalako erreibindikazio burruka —inoiz baino beharrezkoago eta desiragarriago gaurko munduko eskabideetara gero eta hobeto egokiturik— mozturik eta nolabait ezerezean geratuko litzateke.

Enpresetako zuzenpen onak alokairu hobeak eta errenta estableagoak ez ezik, erantzukizunen banaketa ere seguratu behar du ahalik gehienen artean. Hauxe da produkzioko frutuen banaketa berdinkorraren garantia sendo bakarra. Baina hau ez da elkargarri sistima kapitalistaren iraupenaz, sistima honen egokitzeko ahalmenak direnik sakonenak lirela ere.

## *GEHIGARRI*

# ENPRESAKO KONTU PRINTZIPALAK

Urtero edozein elkarte bi kontu printzipalen berri ematera beharturik dago: esplotazio kontua eta balantzea. Hona kontuon azalpen labur bat, bien arteko diferentzien konprenigarri.

A) *Esplotazio kontua*

Urtean zehar eginiko operazio komertzial guztien zehatza da hau.

| Sarrera zerrenda | Gastuen zerrenda |
| --- | --- |
| — Salduriko gaien kopurua | — Pertsonalari ordainduriko alokairuak. |
| — Salduriko makina zaharren kopurua | — Karga sozialak |
| — Enpresari alkilaturiko inmuebleen edo aterbeen alkilerra | — Lehengaien eta makinen erosketa |
| — Daduzkan boltsako akzioen errenta | — Enpresak alkilaturiko lur, inmueble edo patenteen alkilerra, |
| — Eta abar. | — Eta abar. |

*Diferentzia:*

Defizit: sarreratan baino gastutan gehiago badago.

Irabazia: gastutan baino sarreratan gehiago badago.

B) *Balantzea*

Elkartea oraingo honetantxe zer den (sortuta gero) argazkia da hau.

| *Harturena* | *Emanena* |
| --- | --- |
| (elkartearen ondasunak) | (elkartearen zorrak) |
| — Inmobiliarioak (elkarteak daduzkan lur, tailer, inmueble edo makinen oraingo balioa) | — Elkartearen kapitala (elkartearen akzionistekiko zorra da hau, zeren bere aktibitatea uztekotan, haietariko bakoitzari iminitako kapitala errenboltsatu beharko bailikeo) |
| — Stockak (elkarteak almazenean daduzkan lehengaien edo gai fabrikatuen balioa) | — Elkartearen zorrak epe luzera. |
| — Kreditoak klienteei (kienteek elkarteari zor dizkioten kopuruak) | — Elkartearen zorrak epe laburrera (balantzea egin egunean ordaintzeko zeuden gastu batzu dira hauk) |
| — Elkarteak daduzkan boltsako akzioen balioa | — Ebentualki: Bukatzen den urteko irabazia. |
| — Kopuru erabilgarri batzu (elkarteak bankuan dadukan kontua) | |
| — Ebentualki: Bukatzen den urteko defizita. | |
| *Harturen osoa* | *Emanen osoa* |

(Definizioz bi osoek berdinak izan behar dute).

# OHARRAK

(1) Liburu honek Centres d Etudes Socialistes-ean 1960-61-ko ikasaldian emaniko hitzaldiak batzen ditu. Kapitulu bakoitza hitzaldi bati dagokiona da. Aipaturiko organismo, dato, etab. frantziar ekonomiari dagozkio.

(2) Ikus honi buruz, Le Marché Commun, chomage ou prospérité, Editions Monde Oouvrier (54, boulevard Garibaldi, Paris-15).

(3) Hamar urtetan (1950-60) Parisko Boltsan kotizaturiko akzioen prezioak 6,5 bidertu dira... ordu-alokairuena berriz, 2,6 bidertu bakarrik.

(4) "Martin père et fils, kapitalistes moyens et grands voleurs" (Tribune Socialiste, 1961-ko maiatzak 27).

(5) Hauxe da sozializazioa nahi izateko arrazoietarik bat. Beste arrazoi sozial eta politiko batzuk ere alderdi berdinerantz jotzen dute. Geroago, azkenengo kapituluetan mintzatuko gara hauetaz.

(6) Hauzi honi buruz, ikus Perspectives Sozialistes, 33 eta 43-44 aleak (54, boulevard Garibaldi, Paris-15).

(7) Stadistiques et études financières, 1961-ko mareta Analyses et Documents, 14 eta 35 garren kap.

(8) Stadistiques et études financières, 1960-ko apirila.

(9) Hau izugarrikeria langileen etorkizuna akzionistiena baino mila bider zintziliago dagoela enpresako bizitzatik eta zerratzetik pentsatzean, akzionistek beste bizipiderik baitadukate. Hona kapitalismoaren ondorio zatar bat: jabeek bakarrik dukitzea enpresari buruz eskubiderik.

(10) Ikus Houssieaux, Le pouvoir de monopole, eta J. Germain, Le capitalisme en question (Robert Laffont Ed.).

# AURKIBIDEA

# Lur

## hastapenak 20

Ez da erraza liburu bat hainbeste irakurleren beharretara egokitzea.

Baina horretan saiatzea da dibulgazioko egile baten zintzotasunaren garantiarik finkoena eta ezin ukatu, hau izan dela Xabier Amurizak bere kaiolatik liburu hau prestatzean izan duen kezkarik haundiena.

Gaur argitaratzen dugun lehen parte hau izanen da asmo hauen arrakastaren ala hondamendiaren lehen seinalea.